

EGILEA
**Mikel Antza**
1961, Donostia

RÉAU SUD-FRANCILIEN
Centre Pénitentiaire du Sud Francilien
CR 8
Lieu dit du Moulin à Vent
77 550 RÉAU
FRANCE

2004. urtean atxilotu zuten Biarnon, Marixol Iparragirre emaztearekin eta semearekin batera. Susa argitaletxearekin plazaratutako Ospitalekoak eta Ataramiñenbertan aurki daitekeen *Bakarmortuko Kronikak* liburuekin batera *Z*²k, espetxearen izaeraizugarriaz aditu eta sentitzeko aukera ematen digu.



AZALEKO IRUDIA
**Mitxel Zarrabe Elkoroiribe**
1959, Eibar
Atxilotze data: 1989

TERUEL PRISIÓN PROVINCIAL
Avenida de Zaragoza, 26
44.001 Teruel

**www.literaturakoadernoak.org**




ISBN: 978-84-940593-8-4
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL
SS-1545-2013

# ATARIKOA

Z² idazten hasi nintzenean alferrikako zereginean nenbilela pentsatu izan nuen, hain zuzen ere, 2006an "Loiolako prozesua" izenez bataiatu zen horren erdian geunden. Bazirudien, berriro ere, gure Herriak jasaten duen zanpaketa gainditze bidean jartzera zihoala, eta pentsatu nuen, baikorren sokakoa izaki, agian gisa horretako antzezlanek ez zutela inolako zentzurik izango.

Urteak joan dira geroztik, eta presoon etorkizunaren pareko bihurtu da nire antzezlantxo honen patua ere, atera nahi eta ezin. Arrazoi bat zela edo bestea zela, urtez urte bere argitalpena bertan behera gelditu da. "Hainbat hobe" pentsatzen nuen tarteka, antzezlanaren azken eszena gogoan, pixka bat xalo eta barregarri gelditzen delakoan.

Zazpi urte joan dira ia geroztik, eta euskal presoak beti espainiar eta frantses kartzeletan gatibu jarraitzen dugu; Z² bezala, ezin argia ikusi.

Azkenean, itxura denez, aurtengoan bai, moldiztegia (eta sarea ere agian) ezagutuko dute isolamenduko oroitzapen gordinegiak dakarzkidalako berriro ere irakurri nahi izan ez dudan lantxoak.

Duela denboratxo bat burkide batek aipatu zidan antzerki munduan dabilen norbait ezagutzen duela eta agian

interesatuko litzaiokeela nire antzezlana. Beste gehiagorik gabe, hari antzezlanarekin batera igorri nion gutunean azaltzen ditudan azalpenak dira nire ustez aurkezpen-hitz egokienak.

*Kaixo!*

*Jakin dut azkenean ez duzula nire antzerki "ospetsua" jaso, eta Itziarrek zure helbidea eman zidanez, hemen duzu kopia bat.*

*Azken urteotan ATARAMIÑEkoek argitaratu asmo izan dute, baina arrazoi bategatik edo besteagatik beti atzeratu da argitalpena... agian aurtengoan argitara emango dute azkenean.*

*Ez dakit zer antzerki mota egiten duzun/duzuen eta, beraz, antzezlan horretan agertzen direnak zure joerakoak izango ote diren.*

*Dena dela, nik antzerkigileak taldearekin lanean irudikatu izan ditut beti (eta izan dudan esperientzia urrian ere horrela izan zen,* Beteluko Balnearioko Mirakulua*). Hori horrela izanik, eta idazki horrekin zerbait egiteko asmoa bazenute, nahi duzuen moduan erabil dezakezuela esan nahi dizut.*

*Idazkia oinarri bat da, nire ustez; oinarri horretatik abiatuta osatu beharko litzateke jendarteari eskainiko zaion emaitza. Edo beste oinarri bat aberasteko osagaitzat ere erabil daiteke.*

*Zatiak kendu edo gehitu. Zati bat soilik erabili. Alegia, erabateko askatasuna duzuela nahi duzuena egiteko. Nola ez, inolako konpromisorik gabe kaxoi batean sartzekoa ere!*

*Antzezlanaren izenburua nondik datorren azalduko dizut. Aspaldian Jean Geneten* Haute Surveillance *itzuli nuen. Susak argitara eman zuen* Zaindaritza Zorrotza *izenburupean. Antzezlan honetako pasarte batzuek badute haren oihartzunen bat. Eta izenburuak ere horri egiten dio erreferentzia:* **Z***aindaritza* **z***orrotza: zaindaritza ber bi:* **Z²**. *(Bestalde, zigor ziega aipatzeko orduan gutunetan erabiltzen dudan laburdura ere bada z² hori).*

*Azkenik, zerbait egitea erabakitzen baduzue eta laguntza behar bazenute, nahi duzunerako hemen naukazuela jakin ezazu.*

*Besarkada bat*

*Réauko urrezko kaiolan bahituta, 2013ko irailean*

*Mikel ANTZA*

# — DRAMATIS PERSONAE —

EMAKUME BAT
PRESOZAIN BAT
BESTE PRESOZAINA
AGINTEDUNA
GIZON BAT
PRESOA
AMONA MANTANGORRI
POLIZIA-BURUA
TXORIAK
SAGARRA
LAGUNA
EIDER
IKUSLEAK

## — I. ESZENA —

*Bi giza kaiola. Kaiolatuek elkar ez ikusteko, kaiolek hiru horma dituzte, aurrealdea aldiz, burdina-hesiduna da, atea erdian duela. Gainaldea, burdinsareduna eta gandor metaliko apartsuduna, soberazko txarrantxa kiribilduz gainezka. Kaiola izkina banatan zaintze-kamerak. Kaiolen gainaldean igarobidea, bertatik presozainek kaiola barrukoa zaindu dezaten.*

*(Kaiola bakarra dago argituta,* **EMAKUME BAT** *sartuko da bertara, atzetik* **PRESOZAIN BAT** *mozorrotuta. Keinuz, kaiolan sartzeko aginduko dio. Kaiola barrenean dagoenean atea itxiko du eta begira geratuko zaio. Gainaldeko igarobidean* **BESTE PRESOZAINA** *agertuko da, arma luze bat eskuetan. Bera ere* **EMAKUME BAT***i begira geratuko zaio.* **EMAKUME BAT***ek ezkerrera egiten badu alde horretara egingo dute* **PRESOZAIN***ek ere, eskuinera badoa berdin, bere mugimendua jarraituko dute. Horrela ibiliko dira hirurak eszenak iraungo duen artean).*

**EMAKUME BAT**:
(*alde batera eta bestera ibiliko da,* **PRESOZAIN***ei begiratuko die, itzulika ibiliko da, lurrean eseriko da, jaikiko da, begira geratuko zaie, berriro aurrera eta atzera ibiliko da, bere itolarria gero eta nabariagoa izango da. Azkenerako, bere mugimenduek zirku edo zooetako pizti kaiolatuen mugimendu errepikatuen antza izango dute. Bat-batean gelditúko da, biei begiratuko die, ukabila altxa eta ozen garrasi egingo du*) Zoazte zuen arratoi zuloetara!!

**PRESOZAIN**ek:
(*Barre egingo dute. Trufaz*).

(*Argia pixkanaka apalduko da, guztiz ilundu arte. Argi foku bat piztuko da eta taula-gainaren erdian dagoen* **AGINTEDUNA** *argituko du*).

**AGINTEDUNA**:
Zuek lekuko. Ikusi duzue. Terrorista bat. Biolento bat. Odol-egarri arriskutsua. Gizartearentzat arriskutsua. Zuontzat arriskutsua. Jakitun ez bazarete ere. (*Isilunea*). Terrorista, gaizkilea, zuen artean dabil, pertsona normala bailitzan. Egunerokotasunean gurutzatzen duzue, garraio publikoan, lanean, saltoki handitan. Gurutzatzen duzuenean beste edonoren antza hartzen diozue, erreparatu ere ez duzue egiten, jende arrunta da, zuetako edonor bezalakoxea. Hori da izugarriena, esan dezadan bide batez. Ozen gainera. Hori da izugarriena. (*Isilunea*). Ez ezazue zalantzarik egin. Orain bertan, zuen artean daude. Zuetako batzuk, irribarre eztiz, atentzio handiz, entzuten ari zareten horietako batzuk haietakoak zaretela jakin badakigu. Izerditu al zaizkizu eskuak? Albokoa ez da ohartuko. Irudituko zaio pertsona normala zarela. Halakoxeak zarete bai. Hori da larriena, nolako gaitasuna duzuen terroristek jende arrunten antzera bizitzeko, arnas egiteko, jateko, puzker egiteko, kaka egiteko... maitatzeko ere! Hori bai handia! Maitatzeko! Ene! (*Isilunea*). Guk badakigu ordea, mozorroa besterik ez dela. Guk badakigu, zuen galtzarbeetako izerdiaren usaina antzemateen; badakigu, zuen jendetasunaren atzean gordetzen den piztia bere zulotik aterarazten; asmatzen dugu noren irribarre xaloaren atzean ezkutatzen diren letagin odoltsuak. (*Isilunea*). Deseroso zaude aulkian? Noiztik? Ez al zeunden lasai asko oraintxe arte? Zure kontzientziaren zamak urduritzen zaitu, gure behako zorrotzak zure mozorroaren atzekoa ikusiko ote duen kezkak urduritzen zaitu. Arrazoi duzu, baduzu kezkati eta urduri egoteko motiborik. Zure beha gaude, zure zain

gaude, zain duzu gure ostatuan ohea eta mantenua. Zure barneko piztia hori larrutuko dugu. Eta otzan-otzan gizarteratuko zaitugu, haurtzaroan eta gaztaroan ikasi nahi izan ez zenuena ikasita. (*Isilunea*). Badakizu, –eta ez badakizu okerrago zuretzat, jakin beharko zenuke-eta–, bizitza ez da uste bezain konplexua. Xinplea da. Pertsona onak daude eta pertsona gaiztoak daude. Kito. Hemen gaudenak eta hor atzean sartu beharrekoak. Gu gara galbahea eta zartailua, aldi berean. Aski, oraingoz, hartu arnasa lasai, gozatu ikuskizunarekin, zuetako batzuentzat azken ikuskizuna izango den honekin, kanpoan zain baitaude Terroristen Aurkako Talde Bereziak. Zain dituzue, zuen giza heziketaren akatsak zuzendu ditzagun eta egindako krimenak ordaindu ditzazuen, gurera ekarriko zaituzten Estatuaren zerbitzari leial eta sekula ez aski eskertuak. Has dadila ikuskizuna. Nire agindura!

(**AGINTEDUNA***ren txaloaren agindura argi fokua itzali egingo da*).

# — II. ESZENA —

*Taula-gainean bi kaiola. Atea zabal, biak.*

(**GIZON BAT** *sartuko da, atzetik* **PRESOZAINA***, mozorrotuta.* **PRESOZAINA***k keinuz aginduko dio azken kaiolaraino joateko. Kaiolan sartu ahala atea itxiko dio, eta alde egingo du.* **GIZON BAT** *kaiola erdian, geldirik, ingurura begira egongo da. Begiradaz espazio txikia neurtuz; urratsez neurtzeari ekingo dionean burdinazko atetzarraren zarata entzungo da, atera hurbilduko da* **GIZON BAT***).*

(**PRESOZAINA***k* **PRESOA** *ekarriko du.* **GIZON BAT***en ondoko kaiolan sarraraziko du.* **PRESOZAINA** *badoa berriz.* **PRESOA** *kaiolako burdina-hesiei lotuta dago, adi. Burdinazko atetzar baten zarata entzun arte*).

**PRESOA**:
Joan da azkenerako. Va niquer ta grand-mère, pédé! Ea promenadako ordubetea bederen arnasa lasai hartzen uzten diguten! (*Isilunea*) E! Le Basque! Hor al hago?

(**GIZON BAT** *burdina-hesira hurbiltzen da, poliki*).

**PRESOA**:
Le Basque! Hor al hago? Beste ezer behar al duk?

**GIZON BAT**:
Nor haiz?

**PRESOA**:
Higandik hiru ziegatara duan auzokidea.

**GIZON BAT**:
Hik igorri al dizkidak ura berotzeko erresistentzia eta Ricoréa?

**PRESOA**:
Bai, bai.

**GIZON BAT**:
Milesker.

**PRESOA**:
Eta... beste ezer behar al duk? Eska ezak lasai.

**GIZON BAT**:
Ez, ez diat beste ezer behar. Milesker. (*Isilunea*). Hik behar al duk zerbait?

**PRESOA**:
Har ezak boligrafoa eta hasi apuntatzen... xanpaina, kabiarra, emakume eder bat, zerra, soka... Uztak, uztak! Txantxetan ari nauk! Hemendik ateratzeko modurik aurkitzen baduk pasatu errezeta, ados?

(*Isilunea*)

**PRESOA**:
Ahmed nauk. Jakingo bahu nolako zalaparta ibili duten hi hona ekarri aurretik. Denak hituen zain. Ura berotzekoa erosten duanean, itzuli egidak nirea. Kito horrekin.

**GIZON BAT**:
Ados. (*Isilunea*) Badakik nor naizen, beraz.

**PRESOA**:
Bai, bai.

(*Lehengo burdinazko ate zarata berdina entzungo da*).

**PRESOA**:
Bazetozak. Zer arraio nahi ote dute orain! Kaiolako ordubetea ere ez zigutek lasai uzten beren ama ustelen sasikume hauek.

(**PRESOZAINA** *agertzen da,* **PRESOA***ren kaiola aurrera doa, atea ireki eta jarrai diezaion keinua egiten dio. Bitartean,* **GIZON BAT** *burdina-hesiari lotuta egongo da, adi*).

**PRESOA**:
Aio Le Basque! Banaramate, ez zekiat zer nahi duten. Bihar arte!... Kartzela Administrazioak nahi badu.

(*Burdinazko atetzarraren zarata entzungo duenean* **GIZON BAT** *kaiola neurtzen hasiko da berriz, zenbat oin egiten dituen zenbatuz, besoak trapezioko artista baten antzera zabalduz, oreka jolasean*).

**GIZON BAT**:
Baga, biga, higa, laga, boga, sega...

(*Zabalera eta luzera neurtu ostean, beso zabalik geldituko da kaiola erdian*).

**GIZON BAT**: (*Kantari*)

Hegoak ebaki banizkio nirea izango zen,
ez zuen alde egingo,
hegoak ebaki banizkio...

(**GIZON BAT***en kantua apalduz batera, taula-gaineko argia ere apaldu egingo da pixkanaka. Norena ote den jakiterik ez dagoen aiene bat entzungo da ilunpean*).

# — III. ESZENA —

*Aurreko eszenako kaiola berak, baina eskuinaldeko kaiolaren hondoko horman "Gora Euskal Herria Askatuta" idazkuna ageri da. Eusko Gudariak kantua entzungo da.* **GIZON BAT** *agertuko da kantari,* **PRESOZAINA** *mozorrotua bizkartzain duela.*

**GIZON BAT**:

Eusko Gudariak gara
Euskadi askatzeko,
gerturik daukagu odola
bere aldez emateko

**PRESOZAINA**:
Ixo! Isiltzeko! Rapport-a jarriko dizut iskanbila egiteagatik! Beste presoak esnatzen dituzu! Hau isolamendu kartierra da!

**GIZON BAT**: (*jaramonik egin gabe kantuan jarraituko du*)

Irrintzi bat entzunda
mendi tontorrean,
goazen gudari denak
ikurrina atzean

(*Idazkuna duen kaiolako atea irekita egongo da, agindu gabe sartuko da bertan.* **PRESOZAINA***k giltzaz itxi eta alde egingo du*).

**GIZON BAT**:
(*ukabila altxatuta idazkunaren aurrean*) Gora Euskal Herria Askatuta! (*Irrintzi egingo du*). Iuffiii! (*Dantza jauzi batzuk egingo ditu, gorputza astinduko du, korrikalditxo batzuk egiten hasiko da, gelditu eta kantuan hasiko da*)

Kartzela honek sarrera dauka
barruan nago eta badakit
irteerarik baldin badauka
ezkutatu dute ederki
gora eta behera begira nabil
baina aurkitu ezinik
oraingoz irtenbide bakarra
dut bi begiak itxirik

(*Bitartean,* **PRESOZAINA***k* **PRESOA** *ekarriko du eta ondoko kaiolan giltzapetuko. Atetzarraren zaratotsa entzungo den arren* **PRESOZAINA** *berriz agertuko da, eta izkina batean egongo da, isil, adi.* **PRESOA** *ere, eskuak burdina-hesietan, atetzarraren zaratari adi egongo da, adi ere* **GIZON BAT** *kantuan eta dantzan arituko den bitartean*).

**PRESOA**:
E! Le Basque! Bukatu al duk?

**GIZON BAT**:
Bai.

**PRESOA**:
Ondo izorratu duk matoia! Gozoa jarri duk! Horren etxean emazteak agintzen dik! Gaur ere larrutan egin gabe etorri zaiguk eta guk ordaindu behar!

**GIZON BAT**:
(*Isilik*).

**PRESOA**:
Korreorik jaso al huen atzo?

**GIZON BAT** (*eskua poltsikora darama*):
Bai.

**PRESOA**:
Etxekoena?

**GIZON BAT**:
Neskalagunarena.

**PRESOA**:
Zer moduz zagok?

**GIZON BAT**:
Ez zekiat. Ez diat oraindik irakurri.

**PRESOA**:
Nik ere arratserako uzten ditiat. Jasotzen ditudanean.

(*Isilunea.* **PRESOA** *burdina-hesiari helduta, burua* **GIZON BAT** *dagoenera itzulita.* **GIZON BAT** *dantzan hasiko da: "Zazpi jauziak"*).

**PRESOA**:
E! Le Basque!

**GIZON BAT** (*dantza eten eta atera hurbilduko da*):
Zer nahi duk?

**PRESOA**:
Oso interesgarria herenegun utzitako aldizkaria. Irakurri diat. Arratsaldeko matoia sasikumeegia ez baduk bueltatuko diat. Egia al da Espainian torturatzen dutela?

**GIZON BAT**:
Bai.

**PRESOA**:
Ni atxilotu nindutenean poliziek sekulako zaplaztekoak eman zizkidaten. Emaztea ere atxilotuko zutela mehatxu egin zidaten..., ez zidaten lo egiten utzi.

**GIZON BAT**:
Salatu al duk?

**PRESOA**:
Zer salatu behar nuen?

**GIZON BAT**:
Ezer ez.

(*Isilunea.* **GIZON BAT** *soinketa egiten hasiko da, lepo bueltan ekarri duen lehortzeko zapia tolestuta jarriko du lurrean, eskuak bertan bermatuta bular giharrak lantzeko beso-flexioak egiten hasiko da*).

**PRESOA**:
E! Le Basque!

**GIZON BAT**:
Zer?

**PRESOA**:
Zertan ari haiz? Kirolean?

**GIZON BAT**:
Bai. Zer nahi duk?

**PRESOA**:
Ba al duk azukrerik soberan?

**GIZON BAT**:
Bai.

**PRESOA**:
Igorriko al didak gero?

**GIZON BAT**:
Matoiak ez dik nahi izango. Badakik. Hik ez badiok eskatzen, niri ez zidak deus onartuko.

**PRESOA**:
Utzi nire kontu. Hik prestatu daukaana eta igorriko diat arratsaldeko matoia. Uste diat oso sasikumea ez den baten txanda dela. Badakik, burusoilarena.

**GIZON BAT**:
Badakik ez diedala aurpegira begiratzen.

**PRESOA**:
Zergatik?

**GIZON BAT**:
Ez dudalako beren aurpegien oroitzapenik nahi.

**PRESOA**:
Nirearen oroitzapenik bederen ez duk izango. Ez zigutek elkar ikusten utziko. Tira, ez duk asko galtzen. Ez nauk-eta Tom Cruise!

**GIZON BAT**:
Elkarren ahotsarekin konformatu beharko gaituk. Zenbat denbora daramak isolamenduan?

**PRESOA**:
Bi urte.

**GIZON BAT**:
Ez al duk ateratzeko saiorik egin? Hau tortura hutsa duk!

**PRESOA**:
Ohituta nagok. Hemen hobe nagok. Ziegan bakarrik. Modulu arruntean binaka, hirunaka eta baita launaka ere sartzen gaitiztek. Hemen lasaitasuna zagok. Ni oso pertsona urduria nauk, eta beti ditiat istiluak beste presoekin.

**GIZON BAT**:
Eta matoien krudelkeria? Miaketak, biluzteak, mesprezua, ziega-aldaketak, gauetako zaintze-txandakoen sadismoa... Kartzelaratu nindutenetik ez diat gau oso bakar bat bera ere egin. Orduro esnatzen naitek.

**PRESOA**:
Ohituko haiz. Laster, atean kolpea jotzen diatenean oharkabean mugituko haiz, eta kito!

(*Isilunea. Oraingoan* **GIZON BAT** *ez da burdina-hesitik urrunduko. Biak isilik egongo dira*).

**PRESOA**:
Le Basque! Ba al duk tabakorik?

**GIZON BAT**:
Esana diat erretzeari utzi niola.

**PRESOA**:
Gauza ona duk hori, bai jauna! Nik saiatu arren ez diat lortzen ba! (*Isilunea*). Aizak, hilabete honetako mandatua ez zaidak iritsi eta estu nabilek, kantinatuko al didak tabako pakete bat?

**GIZON BAT**:
Bai.

**PRESOA**:
Eskertzen diat. Dirua jasotzean bueltatuko diat. Hik esan zer nahi duan kantinatzea eta erosiko diat. Igandetako pasteltxo bat edo, zer iruditzen zaik?

**GIZON BAT**:
Ez, ez, uztak, behar dudan guztia badiat.

**PRESOA**:
Nahi duan bezala. Aizak, biltzeko tabakoa izan dadila, e? Gehiago iraungo zidak. Eta biltzeko papera ere, ez bazaik inporta.

(*Isilunea.* **GIZON BAT** *ez da mugituko. Biak egongo dira eskuekin burdinazko hesiari helduta*).

**PRESOA**:
Ba al duk ordua?

**GIZON BAT**:
Bai. Gaur ez zidatek kendu ordularia.

**PRESOA**:
Asko falta al duk promenada denbora bukatzeko?

(*Taula-gaina iluntasunean murgilduko da poliki-poliki*).

# — IV. ESZENA —

**GIZON BAT** *bere kaiolan, idazkunaren aurrean ukabila altxatuta. "Gora!" oihukatuko du eta ohiko mugimendu eta jauziak egingo ditu. Ondoren, burdina-hesira hurbilduko da. Une batez zain egongo da.*

**GIZON BAT**:
Ahmed! Ahmed!

(*Ondoko kaiola hutsik dago. Kaiolen gainaldeko igarobidean* **PRESOZAINA** *dabil, batetik bestera*).

**GIZON BAT**:
Ahmed! Eman al ziaten tabakoa eta papera? Ahmed! Hor al hago? Ahmed!

(*Kaiolan aurrera eta atzera ibiltzen hasiko da. Eskumuturrera begiratuko du, baina ez du ordularirik. Lehortzeko oihala tolestu eta bular-giharrak lantzeko beso-flexioak egiten hasiko da, lurretik hurbilduz eta urrunduz. Hamar flexio egin ondoren altxatu eta aurrera eta atzera ibiltzen hasiko da. Halako batean izkina bati begira geldituko da, adi. Makurtu egingo da eta zerbait hartuko du esku ahurrean*).

**GIZON BAT**:
Kaixo, Amona Mantangorri!

(*Argiak pixkanaka-pixkanaka apalduko dira*).

## — V. ESZENA —

**GIZON BAT** *bere kaiolan soinketa ariketak egiten ariko da. Ondoko kaiolako atea ireki eta* **PRESOZAIN BAT** *barrura sartuko da. Zaratak entzutean* **GIZON BAT** *ariketak utzita burdina-hesira hurbilduko da.*

**GIZON BAT**:
(*Zain egongo da une batez*) Ahmed! Ahmed!

**PRESOZAIN BAT**:
Ez, ez nauk Ahmed, Georges nauk.

**GIZON BAT**:
Georges? (*isilunea*) Iritsi berria al haiz?

**PRESOZAIN BAT**: Bai eta ez.

(*Isilunea. Biak egongo dira burdina-hesiari helduta. Nork zer esango zain*).

**PRESOZAIN BAT**:
Aspalditik al hago hemen?

**GIZON BAT**:
Lau hilabete.

**PRESOZAIN BAT**:
Hainbeste! Ufa!

**GIZON BAT**:
Ez duk hainbeste. Ahmedek bi urte zaramatzak. Eramango zitean. Azken egunotan ez diat bere berririk. Leihotik deituta ere ez zidak erantzuten. Bitxia duk. Alde egin aurretik abisatuko zidala esan zidaan. Ez ziotean aukera emango.

**PRESOZAIN BAT**:
Nongoa haiz?

**GIZON BAT**:
Euskalduna nauk. Eta hi?

**PRESOZAIN BAT**:
Ni frantsesa nauk.

**GIZON BAT**:
Baina nongoa?

**PRESOZAIN BAT**:
Bertakoa. (*Isilunea*). Zergatik hago hemen?

**GIZON BAT**:
Harrapatu nautelako.

**PRESOZAIN BAT**:
Barka ezak, motel. Ez baduk horretaz hitz egin nahi...

**GIZON BAT**:
Euskal Herriaren alde borroka egiteagatik nagok hemen.

**PRESOZAIN BAT**:
A! Bai! Hi haiz terrorista!

**GIZON BAT**:
Terrorista ni harrapatu nautenak dituk.

**PRESOZAIN BAT**:
Barka ezak, motel! Ez hindudan mindu nahi.

(*Isilunea.* **GIZON BAT** *burdina-hesitik urrunduko da pentsakor*).

**PRESOZAIN BAT**:
E! Le Basque!

**GIZON BAT**:
Zer?

**PRESOZAIN BAT**:
Zer nolakoak dira hemengo matoiak?

**GIZON BAT**:
Sasikume galantak. Niri behintzat ez zidatek lorik egiten uzten. Etengabeko miaketak jasaten ditiat. Posta ere nahi dutenean ematen zidatek.

**PRESOZAIN BAT**:
Ba al duk ordurik?

**GIZON BAT**:
Ez! Gaur ere ordularia kendu zidatek hona irteterakoan.

**PRESOZAIN BAT**:
Horiek dituk horiek sasikumeak! Ordularia ere kentzen diate?

**GIZON BAT**:
Eta hori gutxienekoa duk. Beren zeregin bakarra gu nola zanpatu asmatzen ibiltzea duk. (*Isilunea*) Georges, ez duk nire kontua, baina hi zergatik hago hemen?

**PRESOZAIN BAT**:
Iruzurragatik.

**GIZON BAT**:
Ez, ez, ez duk hori nire galdera. Zergatik ekarri haute isolamendura?

**PRESOZAIN BAT**:
Ihesaldi saiakera batean harrapatu gintiztean. (*Isilunea*). Nik ezagutu ditiat euskaldun batzuk lehenago ere... Nola zuan... Iñaki izeneko bat bazegoen, La Santén…

**GIZON BAT**:
Badakik, euskaldun asko gaituk kartzelan. Iñaki izen arrunta duk.

**PRESOZAIN BAT**:
Oso jatorra zuan. Denei ematen ziean laguntza. Hiruzpalau euskaldun ibiltzen zituan beti elkarrekin. Beti kirolean, askotan protesta egiteko afixekin ateratzen zituan etxartera. Elkartasun handia duzue zuen artean euskaldunok.

**GIZON BAT**:
Bai.

(*Isilunea*)

**PRESOZAIN BAT**:
Aizak, eta hemendik ospa egiteko asmorik ez al daukak?

**GIZON BAT**:
(*Isilune luzea*) Ipuin bat kontatuko diat. Etzanda dagoen botila batean erle bat, euli bat eta xinaurri bat zaudek. Botilaren ipurdian argi bat zagok piztuta. Erlea, argiak erakarrita botilaren ipurdira itsatsita, ez duk inoiz aterako bertatik. Euliak, noraezeko hegalaldi zoroetako batean ustekabean botilaren ahoko zulotik ateratzea lortuko dik agian. Xinaurriak ordea, mantso-mantso, botilaren bazter guztietatik ibili ondoren, egunen batean ihesbidea aurkituko dik.

**PRESOZAIN BAT**:
Oso polita hire ipuina. Ba al daukak planik?

**GIZON BAT**:
Georges, ez bazaik inporta neskalagunak igorri didan gutuna irakurri nahi diat.

**PRESOZAIN BAT**:
Nola lortu dun gutuna ekartzea!

**GIZON BAT**:
Galtzetan gordeta, zer ba?

**PRESOZAIN BAT**:
Besterik gabe, harritu naik, presozainak oso zorrotzak dituk-eta... (*Isilunea*). Gustu duan bezala egin ezak, irakur ezak gutuna. Zerbait nahi baduk deitu, hemen egongo nauk.

**GIZON BAT**:
Georges.

**PRESOZAIN BAT**:
Zer?

**GIZON BAT**:
Zein ziegatan sartu haute?

**PRESOZAIN BAT**:
7.ean.

**GIZON BAT**:
Hori zuan Ahmedena.

(*Biak gelditkuko dira burdina-hesiari helduta, bata bestearen norabidean begira. Argiak pixkanaka apalduko dira*).

## — VI. ESZENA —

**GIZON BAT** *bere kaiolan, ateko hesiari helduta, zain, beste inor noiz ekarriko adi. Zarata entzungo da.* **PRESOZAIN BAT** *agertuko da. Ondoko kaiolako atea ireki eta, sartu gabe, itxiko du.*

**GIZON BAT**:
Ahmed!

(*Isilunea*)

**GIZON BAT**:
Georges!

*(Isilunea)*

**GIZON BAT**:
Georges! (*Isilunea*) Ahmed!

*(Isilunea)*

**GIZON BAT**: (*Kantari*)

Txikia zuen guda izena,
bera gizon osoa izan arren
Mendizabal, Sasetaren hurrena
biak txiki, bizkor eta lerden.

Saseta hil zen gudarien aurrean,
Mendizabal hil zaigu bakarrik
Baina biek daukate
Herri osoa atzo eta gaur euren atzetik
Euskadirentzat hil dire ta
gorputzak arantzaz beterik

Harro hadi Kantauri itsasoa,
eta haien betiko loa,
betiko kanta ezak
geroari esaiok olatuetan,
Herri zaharrak ez direla itzaltzen.

Gure haurrek biharko ikastoletan,
heien izenak abestu ditzaten
Herriarentzat biak hil baitziren.

**GIZON BAT**:
Inor al dago? (*Isilunea*) Nor zara?

(*Isilune luzea.* **GIZON BAT** *ateko burdina-barrei helduta adi egongo da.* **PRESOZAIN BAT***ek zigarro bat piztuko du supiztekoarekin).*

**GIZON BAT**:
E! Nor haiz? (*airea usnatzen hasiko da, zigarroaren usaina datorkio*) Nor dago hor? Ahmed? Georges?

**PRESOZAIN BAT**:
(*Isilik, giltzatakoari eragingo dio*).

**GIZON BAT**:
Sasikumeak! Gora Euskal Herria Askatuta!

(*Argia bat-batean itzaliko da. Eta segituan argi fokuak* **AGINTEDUNA** *erakutsiko digu).*

**AGINTEDUNA**:
Ez dago zertan gauza nahaspilatu. Zuria, zuria da. Beltza, beltza. Ona eta gaiztoa. Ona eta txarra. Ongilea eta gaizkilea. Parte onekoak eta malapartatuak. Gaiztoak biolentoak dira. Ez baitute onartzen legearen agintea. Komunitatean bizi nahi badugu, beharrezkoa da arauak errespetatzea. Norberaren libertatearen muga non dagoen jakin behar da. Non dago nirearen muga? Hortxe, zurearen muga-mugan. Eta muga gainditzen badut legearen zama nigan eroriko da. Adibidea besterik ez da, noski. Baina badago irakasgai hain xinple eta erraza ulertzen ez duenik. Ulertzeko indarrik egin ez duenik, egiten ez duenik eta sekula egingo ez duenik. Eskolan irakaslearen esanei kasu egin ordez, eulien hegaldiekin ametsetan ibilitakoak. Eskolara joan ordez piper eginez libertitu den jendea. Nahi dutena egin dezaketela uste duten lotsagabeak. Jende hezigabea eta biolentoa. Gaizki heziak. Jende hori atzipetu behar da, jende hori zigortu egin behar da, jende hori zuzendu egin behar da, jende horri erakutsi egin behar zaio zein den bide zuzena, eta bide zuzenetik xuxen ibiltzen erakutsi ere egin behar zaie, esanekoa izaten, otzana. Gizartetik kanpo ibiltzearen ordaina zein den erakutsi egin behar zaie. Eta biolentzia erabiltzen duenak jasoko duen ordaina bortxazkoa izango dela. Nork erakutsi behar die hori ordea? Zuek? Ez noski. Hain zuzen ere, zuek huts egin duzue. Eta zuek huts egin duzuelako agertzen gara gu agertokian (esateko modua besterik ez da, noski). Gure lana da okerreko bidetik dabilena bide zuzenera ekartzea. Saiatzea, bederen. Ez baita lortzen

erraza. Bazenekite! Baina, gutxienik, okerreko bidetik ibilitakoei ordainsaria ordainarazten diegu. Guk egiten dizuegu lan zikina. Inork egin nahi ez duena egin behar izaten dugu, bai. Eta ez da gustuko lana. Zin degizuet. Zuen lasaitasunaren zaindari-lana gogorra eta esker txarrekoa da. Nolanahi, egin beharrekoa. Horretarako ordaintzen diguzue. Eta horregatik preseski, batzuetan gure lanaren kritika egitera ere ausartzen zarete. Mingarria da, zinez. Min egiten diguzue bihotzaren barru-barruan. Giza eskubideak ez ditugula errespetatzen? Gaizkileak sufritzen duela? Eta zer nahi duzue? Ba al dakizue zer egin duten? Zer txarkeriak! Zer izugarrikeriak! Zuen etxeetako egongelako goxoan, besaulki amultsuetan ondo jarrita, telebistako sailetan ikusten dituzuenak ez dira deus guk egunero aurre egin behar diogun izugarriarekin alderatuz gero. Nahi al duzue esatea zer jende odol-gose, sadiko, terroristekin bizi behar dugun egunero? Eta bide onera ekarri behar ditugu gainera! Errazago litzateke sugegorriaren edena edangarri bihurtzea! Aski kalaka, lana dugu eta!

(**AGINTEDUNA***k txalo jo eta itzaliko da argia*).

## — VII. ESZENA —

**GIZON BAT**, *bere ohiko kaiolan.* **EMAKUME BAT** *alboko kaiolan.* **PRESOZAINAK** *batetik bestera ibiliko dira, kaiolen aurretik gainaldeko pasabidera, eta handik berriz behera kaiolan daudenei begira.* **GIZON BAT***ek eta* **EMAKUME BAT***ek, biek, antzeko mugimenduak egingo dituzte, batzuetan batek egindako mugimenduaren oihartzuna bezala izango da bestearena, besteetan alderantziz, baina mugimendu bera biek une berean egiteko ezintasunean baleude bezala izango da.*

**EMAKUME BAT** eta **GIZON BAT**:
(*bakoitza bere kaiolaren erdian, orpoen gainean eserita egongo dira. Gorputza aurrera botako dute, besoak aurrera luzatuz. Lo kanta kantatzen hasiko dira apal)*

Ene maitea zer duzu, zerk ikaratzen zaitu zu...

**EMAKUME BAT** eta **GIZON BAT**:
(*Albo batera utziko dute erortzen gorputza, kizkurtuta geldituko dira, sabeleko haur baten moduan. Gorputza besarkatuko dute. Beti kantu errepikakorra ahoan. Buruz gora jarriko dira ondoren. Besoak eta hankak zabal*).

**PRESOZAINA:**
(*Beti bezala mozorrotuta, bata kaioletara hurbilduko da isilik, gutxika,* **GIZON BAT***en jardunaldia oztopatzeko asmorik gabe, jakin-minez. Begira geratuko zaio, deus esan gabe. Bestea, gainaldeko igarobidetik, beti arma eskuan* **EMAKUME BAT***i begira egongo da, bere kidea bezala, isilik, behekoaren mugimenduak ez eragozteko kontu eginez*).

**EMAKUME BAT** eta **GIZON BAT**:
(*Ez da nabarituko* **PRESOZAINAK** *beha dituztela konturatu diren ala ez. Lurretik jaiki eta gorputz atalak mugitzen hasiko dira, mugimendu bakoitza arretaz aztertuz, adi, beren gorputza lehen aldiz deskubrituko balute bezala. Gorputza aztertuko dute, gorputza ferekatuko dute, besarkatuko dute, kontsolatuko dute*).

**PRESOZAINA:**
(*Zerbait esan edo zerbait egiteko keinua egingo dute, baina izoztuta bezala geratuko dira, ikusitakoak sorginduta bezala. Horrela egongo dira eszena amaitu bitartean, lekuko mutu, izoztu eta ikusezinak bailiran*).

(**EMAKUME BAT** *eta* **GIZON BAT** *aurrera eta atzera ibiltzen hasiko dira, orain beren mugimenduak azkarrak izango dira, aurrekoekiko kontrastean, luzeak eginez, hondoko hormaraino iritsi eta itzulia hartuz aterantz egingo dute, urratsen erritmoan hitz egingo dute*).

**GIZON BAT**:
Zergatik?

**EMAKUME BAT**:
Euskal gudaria naiz!

**GIZON BAT**:
Ez nago bakarrik.

**EMAKUME BAT**:
Noiz arte?

**GIZON BAT**:
Euskal Herriaren askatasunaren alde borrokatzegatik!

**EMAKUME BAT**:
Bakartuta nago.

**GIZON BAT**:
Nor naiz?

**EMAKUME BAT**:
Irabazi arte!

**GIZON BAT**:
Ez gaude bakarrik.

**EMAKUME BAT**:
Non nago?

**GIZON BAT**:
Kartzelan naukate.

**EMAKUME BAT**:
Maite haut.

**GIZON BAT**:
Maite haut.

*(***GIZON BAT***ek aterantz begiratuko du.* **PRESOZAIN BAT** *izango du aurrez aurre. Elkarri begira egongo dira. Elkar ikusi gabe. Isilik. Mugitu gabe.* **EMAKUME BAT***ek gora begiratuko du.* **BESTE PRESOZAINA** *izango du begira, armarekin destatuz. Elkarri begira egongo dira. Elkar ikusi gabe bezala. Isilik. Mugitu gabe).*

**GIZON BAT**:
(*harrituta bezala*) Eta hi, nor haiz hi?

(*Argiak emeki apalduko dira, ilundu arte*).

## — VIII. ESZENA —

*Bi zigor-ziega berdin, ispilu eginez. Banatze hormarik ez dago. Ziega bakoitzean, aurrez aurre, elkarri lotutako metalezko mahai txiki eta aulkia, ohea, komuna eta harraska. Leiho txiki bana ere, goialdean. Izkina batean zaintze-kamera. Argi-ilunean daude ziegak.*

(*Ezkerreko ziega argituko da,* **GIZON BAT** *biluzik egongo da ziega erdian zutik, bere ondoan, lurrean pilatuta, arropak. Ohe gaineko lastaira altxatuta egongo da, izarak bazter batean pilatuta. Mahai gainean orri batzuk, boligrafo bat. Lurrean botata ere, liburu bat. Sarraila hotsak entzungo dira, urruntzen, ate danbatekoak, oihuren bat. Dena isil gelditu arte*).

**GIZON BAT**:
(*Janzten hasiko da, poliki, isilik, ohitura adieraziko duten keinuz. Jantziko denean, liburua bilduko du, ohea egingo du, izaren ertzetan zerbaiten bila arituko da zabaldu aurretik, ziega erdian zutik geratuko da. Argia itzaliko da*).

(*Eskuineko ziega argituko da,* **EMAKUME BAT** *biluzik egongo da ziega erdian zutik, desegin gabeko ohe gainean arropak. Mahai gainean orri batzuk, boligrafo bat eta liburu bat. Sarraila hotsak entzungo dira, urruntzen, ate danbatekoak, oihuren bat, dena isil gelditu arte*).

**EMAKUME BAT**:
(*Janzten hasiko da, poliki, isilik, erritu baten zati balitz bezala. Janzten denean, atera hurbildu eta danbatekoa emango dio)*
Sasikume nazkagarriak!
*(Ziegan aurrera eta atzera ibiltzen hasiko da, atera iristean ostikada emango dio edo eskuz joko du. Argia itzaliko da).*

*(Ezkerreko ziega argituko da,* **GIZON BAT** *mahaira eserita egongo da. Eskuineko ziega argituko da,* **EMAKUME BAT** *mahaira eserita egongo da.* **GIZON BAT** *eta* **EMAKUME BAT** *idazten hasiko dira).*

(**PRESOZAINAK** *agertuko dira,* **GIZON BAT***ek eta* **EMAKUME BAT***ek orriak idatzi ahala bilduko dituzte eta bi ziegen artean dagoen* **AGINTEDUNA***ri emango dizkiote. Honek, azkar irakurriko ditu, orri batzuk zimurtu eta zakarrontzira botako ditu, beste batzuk nahasi egingo ditu. Ondoren* **PRESOZAINEI** *itzuliko dizkie orriak banan-banan.* **PRESOZAINEK***,* **GIZON BAT***i eta* **EMAKUME BAT***i eramango dizkiete orriak. Orria jaso ahala ozen irakurriko dute eta idazten jarraituko*).

**EMAKUME BAT**:
"Egun on, maitea!".

**GIZON BAT**:
"Egun on, maitea!".

**EMAKUME BAT**:
"Gau txarra izan dinat bart. Kartzelan geundela amets egin dinat".

**GIZON BAT**:
"Ez diat batere ondo lo egin. Bart ere bospasei aldiz esnatu naitek".

**EMAKUME BAT**:
"Ez zakinat nola, kartzelatik ateratzea lortu dinagu. Kalean genbiltzanan, libre. Bat-batean larritu egin naun, berandutzen ari zitzaigula konturatuta, azkar ibili behar genuela kartzelako atea itxi baino lehen iritsi nahi bagenuen. Hiriko kaleetan galduta ibili gaitun, bidea ezin aurkituz. Azkenerako ate ezkutu batetik sartzea lortu dinagu eta bazka banatu aurretik norbera bere ziegan geundenan".

**GIZON BAT**:
"Sutan nagok!".

**EMAKUME BAT**:
"Deitu bada suhiltzaileei!".

**GIZON BAT**:
"Kakingarri diagu gaur. Zakar-poltsa eta posta biltzerakoan probokatzen aritu zaidak. Entzun nahi ez zituen batzuk entzun ditik. Mendeku hartu ditek: ziega eta gorputz miaketa. Hilekoa nuela ikusi duten arren, konpresa ere kendu zidatek".

**EMAKUME BAT**:
"Ideia ona dun, izaretan oinen aldea boligrafoz markatzearena. Bestela gazta usainarekin lokartzeko arriskua zagon... Bereziki umiliagarria izan dun gaurko biluztea. Doaneko larderia. Ahoa irekitzea nahi zitenan, ondoren ipurtzuloa erakutsi behar niela keinu egin zidaten. Nik, ezetz eta ezetz, luze eduki naiten biluzik, beraiek inguruan nituela, begira, barrez".

**GIZON BAT**:
"Ideia ona duk, bai, izaretan amets aldea boligrafoz markatzea".

**EMAKUME BAT**:
"Demha eraman diten. Ez zakinat noiz. Orain beste preso bat agertzen dun ondoko kaiolara: Monsieur Plan edo Monsieur Peter Plan. Nire irudiko Monsieur Kakusain. Kazetaria dela zirudin, hori galderak egiteko afizioa duena! Berak aldiz erantzun labur eta faltsu tankerakoak besterik ez. Nahi niken ikusi zer aurpegi duen. Pena dun Demha eraman izana, berarekin bederen arabiera pixka bat ikasten ninan. Honekin aldiz...".

**GIZON BAT**:
"Muxu burusoiltxoan!".

**EMAKUME BAT**:
"Ez naizela burusoil geratzen ari!".

**GIZON BAT**:
"Jaiotzetik soil duan burutxoan, alproja!".

**EMAKUME BAT**:
"Jarriko nioken gustura ileordea!".

**GIZON BAT**:
"Zer moduz habil arabiera klaseekin? Kontuz ibil hadi ez ote duten eusko-islamiar konexio estrainioren bat asmatuko…".

**EMAKUME BAT**:
"Araba-Saudi. Basque Conection".

**GIZON BAT**:
"Exkaxa benetan!".

**EMAKUME BAT**:
"Goizean Ilar-Bakar-i dutxa eskatu zionat. "Bi minutu" esan zidan. Zain nagon oraindik. Badakin, "bi minutu" berdin "gogoa emango didanean", "bost minutu" berdin "hoa antzarak ferratzera". "Oraintxe bertan" berdin "ustel hadi bertan". Bon soirée, guk festa eta hik batez! Aio. Krix-krax".

**GIZON BAT**:
"Ilarrak zeudek bazkan".

**EMAKUME BAT**:
"Txuleta gustura jango niken".

**GIZON BAT**:
"Errea".

**EMAKUME BAT**:
"Atzo auzoko batek su eman zionan ziegari".

**GIZON BAT**:
"Sutan nagok!".

**EMAKUME BAT**:
"Deitzeko bada suhiltzaileei!".

**GIZON BAT**:
"Egarri nauk".

**EMAKUME BAT**:
“Gogoratzen dun udatan joaten ginen erreka? Dutxan, begiak itxi eta hor irudikatzen haut. Igeri nabilen, amuarrainen artean, eta hi ur azalean, nire bila. Banoakin marrazoa bezala, behetik gora, eta brau! Zatirik goxoenean kosk!”

**GIZON BAT**:
“Ai! Nire zangoa!”.

**EMAKUME BAT**:
“Ezetz zozola! Zangoan ez!”.

**GIZON BAT**:
“Aaaa! Bai gozoa! Berriz!”.

**EMAKUME BAT**:
“Egarri naun”.

**GIZON BAT**:
“Begi Bakar pasatu duk. Isil isilik. Beha-zuloaren estalkia altxatzen ere ez diat sentitu. Ate aldera begiratu dudanean hortxe nian, begira-begira”.

**EMAKUME BAT**:
“Antzerki lan bat idazten ari naun”.

**GIZON BAT**:
“Ni ere begira gelditu natzaiok. Ez zian alde egiten. Uste diat Alkohol zela, estalkia irekita utzi baitu. Jaiki eta ostikada emango niokek ateari. Ixteko estalkiaaa!!!”.

**EMAKUME BAT**:
“Ohean etzatera noan, nekatuta nagon. Bahator ondora? Helduko al naun estu-estu? Klak!”.

**GIZON BAT**: “Bai”.

(**GIZON BAT** *jaikiko da, oheratu eta hormari begira etzango da. Negar zotinka hasiko da, apal.* **EMAKUME BAT** *jaikiko da, eta bi ziegen arteko banaketa trabeskatuz badoa* **GIZON BAT***engana. Ohean etzango da eta bizkarrez helduko du, estu-estu, hankak ere harenekin egokituz, bat egin arte. Argia pixkanaka-pixkanaka apalduko da*).

(**AGINTEDUNA** *agertuko da, hitz egingo duen artean aurrera eta atzera ibiliko da, ziega batera sartuz lehendabizi eta gero bestera, besarkatuta dagoen bikoteari begira geldituko da, urrunduko, hurbilduko, tapakiaz estaliko ditu eta gero tapakia altxatu eta begira geratuko zaie, mahaian gelditu diren idazkiak eskuetan hartuko ditu, marmarka irakurriko, berriz utziko, irribarrez, mintzaldia eten gabe, etxean balego bezala, bere etxean dago-eta!, aise mugituko da*).

**AGINTEDUNA**:
Bihotz gabetzat hartzen gaituzue. Gu ere humanoak garela, zer arraio! Gogor hartzen dugula jendaila hau? Besterik merezi al dute bada? Ba al dago beste metodorik? (*Isilunea*). Guk ere nahigabea sentitzen dugu. Gu ere goibeltzen gara. Guk ere badakigu, ongi dakit nik!, zer den sufritzea. (*Isilunea*). Zer uste duzue sentitzen dugula guk, haur bat bere aita ikustera datorrenean? Urtez urte haur hori nola hazten den ikusten dugunean? Zer uste duzue, ez zaigula bihotza samurtzen? Bost urteko haurra hogei urteko gaztea bihurtzen ikusi

dut nik, hamabost urtez bere aita ikustera etortzen ikusi dut nik. Eta zer uste duzue? Ez dudala deus sentitu? Ez dakizue zein gogorra den, zuek ez dakizue, ez. (*Isilunea*) Maitasuna. Ez dago munduan sentimendu gorengorik. Baina begira iezaiezue hauei. Ez nahastu sexu grina eta maitasuna. Maitasuna dagoen tokian sexuaren tokia neurrizkoa da. Sexuak dena betetzen duenean, ez dago maitasunik. Ongi bereiz daitezke maitasuna eta sexua. Ulertuko duzue. Zuetako nor ez da inoiz emagaldu batekin oheratu? Maitasuna al da hori? Ez, noski. Sexua da, sexu hutsa. Emaztea etxean edukita emagaldutara joateak ez du emaztearekiko maitasuna den mendrena ere gutxitzen. Lohitzen. Sexua beste zerbait baita. Nola ez, emaztearekin ere larrutan, barkatu espresioa, egiten duzue, baina ez da gauza bera, hor maitasuna baitago, gutxiago ala gehiago, baina maitasunaren pindarra bizirik dago. Ez noski lehen eguneko sumendiaren garraz. Maitasunak sexua behar al du bizitzeko? Ez! Gauza bi baitira. Maite duenak maite du, larru kontuekin ala gabe. (*Isilunea*). Orain, gatozen bortxa maite duen jende honen kasura. Hauen grina sexuala asetzeko baliabideak guk jarri behar al ditugu? Zer esan nahi didazue, geltoki inguruetara, aldirietara joan eta bertan putak bildu eta bortxa jende honi eskaini behar dizkiegula? Begira, oso erraza da, maitasuna dagoen tokian, sexu harremanik gabe ere maitasuna biziko da. Baina, ez zait iruditzen niri gorrotoan hazi eta hezitako jendaila honek maitasuna zer den ere badakienik. Sexu grina bai! Eta nolakoa! Denak dira bortxatzaile potentzialak. Entzun beharko zenituzkete gauero porno-filmaren orduan ate zirrikitutatik eta udan leiho zabalduetatik irteten diren intziriak. Nik entzun ohi ditut. Elkarri popatik ematen ibiltzen ez direnean! (*Isilunea*). Injustizia handia egiten duzue gurekin. Guk harria bihotzaren ordez omen dugu eta hiltzaile hauek ordea aingerutxotzat dituzue!

(**PRESOZAINAK** *agertuko dira.* **AGINTEDUNA**k *eta* **PRESOZAINEK** *mahaien gainekoak lurrera botako dituzte.* **GIZON BAT** *eta* **EMAKUME BAT** *bortxaz esnatu eta ohetik aterako dituzte, txano bana buruan jarrita eramango dituzte, oihu, irain eta garrasi artean. Argiak kliskaka ariko dira eszenatokia hustuko denean, itzali arte*).

# — IX. ESZENA —

**GIZON BAT** *bere kaiolan. Artilezko txano bat du eskuan.*

**GIZON BAT**:
(*Txanoa jantziko du*)
Erraza da. Hik esadak nik jakin nahi dudana, eta nik eginahalak egingo ditiat epaileak libre utzi hazan.

**GIZON BAT**:
(*Txanoa erantzi eta kaiolako beste aldera doa poliki, besoak atzean jarriko ditu, eskuak lotuta balitu bezala*)
Ez dut esatekorik.

**GIZON BAT**:
(*Badator berriz lehengo aldera txanoa jantzi bitartean*)
Begira, hortxe, hi hagoen aulki horretan eduki ditiat mordoxka bat. Asko hi baino sendoagoak. Eta azkarrenek nire proposamena onartu zitean. Lehenago ala beranduago. Hi azkarra haiz. Hi inteligentea haiz. Erakuts egidak nolako azkarra haizen. Hi ez haiz beste gaizkile txoriburu horiek bezalakoa. Hik ikasketak eginak dituk. Zer ikasi duk? (*Isilunea*) Ez al duk ikasi aukerak baliatu egin behar direla? (*Isilunea*) Gure artean: hau duk hire azken trena; gero, akabo! Bizi arterakoa duk zain!

**GIZON BAT**:
(*Txanoa erantziz lehengo lekura itzuliko da*)
Ez dut esateko ezer.

**GIZON BAT**:
(*Txanoa jantziz poliziaren kokagunera joango da*)
Ea bada. Futbola maite al duk? (*Isilunea*) Ez, noski, hi intelektuala haiz, hik ez dituk herri xeheak dituen afizio masifikatuak, hik antzerkia maite duk, ezta? (*Isilunea*) Eta irakurtzea. Tira, alde horretatik begiratuta zorionekoa haiz, jarrera egoskor eta zentzugabe horretan tematzen bahaiz, izango duk, bai, irakurtzeko aski denbora. Hik uste baino gehiago. (*Isilunea*) Badakik hire egoera horretan tematzen bahaiz seme-alabak gelaxka zikin batean eta hilean ordu erdiz baino ez dituala ikusiko? Badakik guztia galduko duala? Badakik dagoeneko guztia galdu duala?... (*Galderak ahots doinu gero eta gogorragoz egingo ditu, eta bat-batean esan behar duena ahaztuko zaio. Galtzetako poltsikotik paper zimurtu bat aterako du, txanoa erantziz, marmarka irakurriko du, gero berriro txanoa jantziko du eta haria hartuz*)… Bai… Badakik ez duala gehiago emaztea ikusiko? Bukatu duk zuen artekoa! Fini! (*Isilunea*). Baina oraindik baduk azken aukera bat, hire esku zagok oraindik, epaileak aske ez utzita ere, laguntzen badiguk baldintza hobeak lortzen lagundu hazaket. Kartzelan pasatu beharreko denbora ere laburtzea lortuko diat agian, nork daki... Hik hartu behar duk erabakia. (*Isilunea*). Hirea duk hitza.

**GIZON BAT**:
(*Presaka doa atxilotuaren kokagunera txanoa erantziz*)
Ez dut ezer esateko!

**GIZON BAT**:
(*Hor bertan txanoa jantzi eta itzulia hartuz*)
Bai! O, baietz! Asko duk esateko! Bai, txikito! Eta esateko dituanak, guztiak interesatzen zaizkiguk. (*Doinua lasaituko du*) Egia esatea nahi baduk, niri, pertsonalki, ez zaizkidak batere interesatzen. Badakik, nik (*eskumuturrera begiratzen du ordularia balu bezala*) ordu erdi barru

bukatu diat laneguna. Hemendik atera, autoa hartu eta banoak etxera. Emaztea eta haurrak zain ditiat. Lehendabizi dutxa bero bat hartuko diat, gero goxoan afalduko diat, haurren eguneko gorabeherak entzunez, eta oheratzean emaztearekin larrutan egingo diat. Beraz, niri bost axola zaizkidak kolkoan gorde nahi dituanak. Hik ahoa ireki ala ez, niri berdin ordainduko zidatek. Hire hobe beharrez ari natzaik.

**GIZON BAT**:
(*Txanoa erantzi eta zorrotz erantzungo dio, beste ezer esateko tentazioa hortzen artean estutuz*)
…Ez dut ezer esateko.

**GIZON BAT**:
(*Txanoa jantziz, orain lasaiago poliziaren kokagunera joango da*)
Eta orain usteko duk mehatxu egingo diadala, "ni banoak, orain zatozak astakirtenak, horiei dena esan beharko diek"... ez, ez, gu ez gaituk espainiarrak bezala, gu ez gaituk astapotro torturatzaileak, horiek alferrikako sistemak dituk. Lasterbideak dituk. Bazekiat, bai, zertaz ari naizen! Guk asmatuak baitira! Presa dagoenean erabili beharreko lasterbideak dituk. Haatik, guk ez diagu presarik batere. Denbora gure alde diagu. Tik-tak, tik-tak. Segundo bakoitzeko zuek ahuldu eta gu indartzen gaituk. Badakik, azkarrago ala beranduago denak eroriko zarete gure eskuetan. (*Isilunea*). Eta zuen metodo horiekin jarraitzen duzuen bitartean ez duzue ezer lortuko. Mundu guztia zuen aurka jartzea ez bada. (*Isilunea*) Begira, bazekiat pertsona diskretua haizela eta konfesio bat egingo diat: ni ez nagok zuen helburuen kontra, ondo begiratuta alde ere egon nintekek, kulturaren balioak defendatzea, herriarenak, herritarren arteko berdintasuna… Asko harrituko al haiz nire aitatxi euskaldun jatorrikoa zela esaten badiat?... (*Isilunea*). Erabiltzen dituzuen metodoak dituk arazoa!

Mundua aldatu da! Biolentziarekin ezin da deus lortu! Gaur egun demokraziaren baloreak dituk tresna bakarra, defendatu zuen ideiak politika hutsarekin! Izan zaitezte buruargiak, izan zaitezte ausartak, zer arraio! (*Isilunea*). Horixe duk koska, azkenerako jende koldarra zaretela. Ez duzuela errealitatea den bezala ikusi nahi, errealitatea den bezala onartu nahi, errealitate hori aldatzeko baliabide demokratiko hutsak erabili nahi. Errealitatearen beldur zarete! Herriaren izenean mintzo zarete, baina herriaren beldur zarete!

**GIZON BAT**:
(*Txanoa erantziko du poliki. Ahoa irekiko du, baina ez du hitzik egingo. Bizkar emango dio poliziari*)
Ez daukat deus esateko. Ez zuri behintzat. Baina hau hitz egin beharra dudana! Zorabiozko abiadan gurutzatzen diren esaldiz gainezka dut burua. Denak nahas-mahas. Eta ezin ehizatu! Geldiune laburregiak egiten dituzte. Zentzuzko ideia bat antzematen dudanerako gainerakoak hitzen basoan desagertu zaizkit! (*Isilunea*) Lo egin beharko nuke. Atseden hartu. Zuek besarkatu. Zenbat ordu daramagu beren eskuetan? Non hago? Non dauzkate gure haurrak? Zenbat gara atxilotuak? Noiztik izan ditugu zelatan? Banengoen bai lehengo egunekoa ez zela oso normala izan, usain txarra zuela auto horrek egin zuen maniobra. (*Isilunea*). Etorri behar zuena etorri da. (*Isilunea*). Ba al du inork eskuliburirik?! Nola biziraun behar dugu hemen?! (*Isilunea*). "Ez dut ezer esateko", bale, hori banekien eta primeran egiten dut. Eta ondoren? A! Hori al da dena? Urlasterrean gorputza joaten utzi, itsasoan olatu handiegiak datozenean bezala, aurre egin gabe, arnasari eutsi, batetik bestera, zurrunbiloan indarge, haien eskuetan. Ehizakiak bagina bezala. (*Isilunea*) Eta bitartean, hortzak estutu, dena behatu, aztertu. Ez pentsatu, ikusi, entzun,

oroitu, guztia ondo irarri garunean. (*Isilunea*). Biziraun. (*Isilunea*). Borroka egin.

**GIZON BAT**:
(*Txanoa jantziko du poliki, poliziaren kokagunera joango da, erretzen duenaren itxura egingo du: poltsikotik tabakoa ateratzeko keinua, zigarro bat atera, tabakoa gorde, pospoloak bilatu, atera, zigarroa piztu eta lehen xurgadako kea sabairantz botako balu bezala*)
Zer? Ez al didak ezer esan behar? "Ez dut ezer esateko" txatxu hori ere ez? (*Isiltasuna*). Euskaldunen elkartasunaz asko entzuten da, baina gero, egiaren orduan, zuei laguntza eman dizuetenak salbatzeko ere ez duzue deus egiten. (*Isilunea*) Pertsona heldua haiz hi. Entzun, zuenak egin dik, zuenak ez dik erremediorik, are mututasun horretan tematzen bahaiz. (*Isilunea*). Baina badakik ongi asko ez duela merezi zuen herriko gazteria horrela sakrifikatzen jarraitzeak. Egin ezak zerbait gazteengatik! Zuen seme-alabengatik! Borroka zentzugabe, borroka ero horrek jarraitzen badu zuen seme-alabek ere ordainduko ditek! Amaitzeko tenorea duk! (*Isilunea*) Onartu: galdu egin duzue. Porrot egin duzue. Ez zagok egunsenti iraultzailerik etorkizunean. Hori guztia txoriburuen literatura merkea besterik ez duzue. Beren egongelako epelean arduragabe batzuek errundako asmakeriak dituk, ameskeriak, ez hanka eta ez buru dutenak. (*Isilunea*) Bizitza hori baino sinpleagoa eta aspergarriagoa duk. Baina gozoagoa ere! Jaiki, gosaldu, lanera joan, lagunekin eta senideekin goxoan egon, bakantzetan joan… eta bizitza nola doan ikusi: haurrak hazten eta norbera zahartzen. (*Isilunea*) Alferrik duk bizitzaren norabidea aldatzen saiatzea. (*Isilunea*). Hi ez haiz sinestuna izango, noski. (*Isilunea*) Ni ere ez. Ez bederen erlijio eta horrelakoekin. Pertsonarengan sinesten diat nik. Konturatzen nauk ez haizela berez pertsona gaiztoa. Ziur aski asmo onez aritu haiz. Irtenbiderik ez dagoela konturatzean, sartuta dagoen zurrunbilotik

nola atera ez dakienaren egoeran hagoela esango nikek. (*Isilunea*). Ni ez nauk jainko, baina irtenbide bat eskaintzen diat: amai dezagun erokeria hau guztia! Ekar dezagun bakea gurera eta zuenera! Azken finean, hurbiletik begiratuta interes berdintsuak ditugu-eta zuek eta guk.

**GIZON BAT**:
(*Txanoa kenduko du, baina ez da joango atxilotuaren kokagunera, kaiola erditsuan geratuko da*)
Hau guztia ez ote da arruntegia? Zer interes du tortura fisikorik gabeko galdeketa eszena batek? Nola agertaraz dezaket arimaren sakonenean eragiten duten urradura? Norbera bere buruarekin bakarrik geratzen denean, senide eta lagunengandik bereizita, telebista itzalita, liburua eta idaztekoak albo batera, goi mendi batean balego bezala, baina haize fresko osasuntsuaren ordez, infernuko zulo sakonen honetako gorroto, mendeku eta beldurraren kiratsak besarkatuta, eta ikusmiran, ez esnezko lainorik, ez bailara sakon ikusgarririk, ez eta urrunean betiko elurrez apaindutako gailur ederrik, baizik eta horma zikinak, idazkun txatxu edota desesperatuekin, eta zoru lirdingatsuak… nola eman orduan garunean onddo pozoitsuak bailiran hazten diren pentsamendu ilunen berri? (*Isilunea*). Sekula ibili gabeko bideetan goaz, albo bietara amildegi hondorik gabeak dituzten bidezidorretan, abaila arriskutsuz. Bazeudenik ere uste ez genuen azpimunduetan igeri egiten dugu, ozta-ozta. Ahoa irekiz gero ur uherrak irentsiko ditugu, itoko gara; ahoa irekitzen ez badugu, ordea, arnas gabe itoko gara. Ahoa irekitzean, ur uherrak irentsi eta goitika egin ondoren gure minen berri ematen hasten garenean, ba al dugu entzulerik? (*Isilunea*). Inor egotekotan ulertzen al du ezer? (*Isilunea*). Ez. Ezinezkoa da. Ez baita asmatu arimaren argazkia egiteko makina. (*Isilunea*). Aurpegia ubeldua banu sikiera. (*Isilunea*). Nola adierazi behar dut ohean etzan eta haur ttipi baten

negarra eragiten didan min hau. Hemen dut bihotza. Bihotzean min dut. (*Isilunea*). Non dut ordea beste min hau eragiten didan organoa? Buruan? Aspirina bat, mesedez. (*Isilunea*). Gillotinatxo bat, s'il vous plait.

(*Zarata metalikoa entzungo da,* **GIZON BAT,** *hariak moztutako txotxongilo bat bezala, ziplo eroriko da lurrera, aieneka. Argia itzaliko da,* **GIZON BAT** *ilunpean utziz. Argi fokuak* **AGINTEDUNA** *argituko du*).

**AGINTEDUNA**:
Hau bai dela handia! Pertsona ona dela usteko du oraindik. Gillotina bat! Hori bai lasterbidea! Ez, ez, ez, gillotinarik ez! Ikuskizun zenean bai, noski. Herriak gaizkilearen amaiera ikusten zuen, eta ikasten zuen, disfrutatzeaz gain. Baina gero, batek daki zein moral eta etika hipokritan oinarrituta, exekuzioak espetxeko hormen atzeko bakardadean egitera behartu zituztenean, zertarako gillotina? Noren eskarmenturako? Tresna indargabetua bihurtu zen, ez bazen taldetxo odol-gose sadiko batentzat. Erraza! Gillotina, eta fini, voilà. Ez, ez, ez. Sufritu egin behar duzue, zuen egintzak ordaindu. Infernuan gillotina dagoela uste al duzue? Infernuan su eztitan egosten dira bekatariak eta kriminalak, betirako, amai gabe. Egin bedi zure nahia infernuan bezala lurrean ere. Hori bai asmakizuna! Su eztitan, motel! Labana kamutsarekin zainak moztea bezala. Odolustu, bai, baina tantaka. (*Isilunea*). Burua moztu ordez garuna burezurrean zimeldu. Eta gero, bai, Luziferren txanda. (*Isilunea*). Badakit zer esango didazuen: kartzela barruko sufrimenduaren berririk ere ez duela gizarteak. (*Isilunea*). Egia diozue. Aitor dut. Arrazoi oso-osoa duzue: sistema ez da perfektua. Baina zer nahi duzue!, ezin hasiko gara kartzelen barrunbeak erakusteko bidaia turistikoak antolatzen! (*Isilunea*). Halere, ari gara akats hori konpontzeko ordezko bideak lantzen.

Egin kontu gaur egun ez dela lehen bezala, gaur egun ia edonor joan daiteke kartzelara denboralditxoa pasatzera, "bakantzetan"! (*Barre egingo du bere ateraldiarekin harro*) Ez da gaiztakeria handiegirik egin behar. Erraztasunak ematen ditugu. Arau-hauste txikiengatik ere, barrura! Eta onerako!, ez egin zalantzarik! Irtetean zenbatek ez ote digun eskertu kartzelan egindako egonalditxoa? Zenbatek ez ote digun esan kartzelako atarian: "milesker, ez dut inoiz gehiago legea hautsiko, ikusi dut, eta ikasi dut". Adio, betirako. Au revoir-ik ez. Bezero bat gutxiago, eta doako propaganda guretzat! Gizartearentzat! (*Isilunea*). Baina, zertaz ari ginen? Ez al dut haria galdu? Gillotinari buruz ari ginen.

(*Gillotina baten labanak erortzean egiten duen hotsa entzutearekin batera itzaliko da argia, bat-batean, agertokia ilunpean utziz*).

# — X. ESZENA —

*Ondoko kaiolan egongo da* **GIZON BAT**. *Kaiola honetan ere, hondoko horman, lehen ez zegoen idazkun bat agertuko da orain: bukatu gabeko "Gora E".*

(**GIZON BAT***ek* **PRESOZAIN BAT** *inguruan ez dagoela ziurtatu ostean, zaintze-kamerari bizkar emanez sagar bat aterako du hankartetik*).

**GIZON BAT**:
Lortu diagu! Tatxan! (*mago baten plantak eginez sagarra desagertu eta agertaraziko du pare bat alditan, eta azkenean kamerari erakutsiko dio*) Arranopola! Sagar bat! Nondik heldu ote da? (*Gora begiratuko du*). Hegoaldera doazen txorietako bati eroriko zitzaion bizkar-zorrotik. Milesker sagar-txori maitea! Entziklopedian begiratu behar dut nolako lumajea dunan. Hurrengoan ahal badun sagardo botila bat ekarri, gustura edango niken! Eta txuleta-txori ikusten badun, esaion sagardoaren lagungarri txuleta eder bat gogotik jango dudala ere. Eta intxaur-txori, irasagar-txori eta gasna-txoriri ere esan itzuliño bat egiteko infernu gainetik. Helbidea baduzue, ezta? Badaezpada ere berriz emango dizuet. Hartu luma bat eta idatzi: "Infernu-zulo-enea, Inora-ez Etorbidea, Infinitu zenbakia, azpi-azpiko solairua. Kode postala Bat-bat, alegia, hamaika, eta "K" bi aldiz: Hamaika Kaka". (*sagarrari begiratuko dio, besoa luzatuz*) Jan ala ez jan, horra zalantza.

*Aldapeko sagarraren*
*adarraren puntan,*
*puntaren puntan,*
*urkatua zegoen dantzari,*
*txiruliruli, txiruliruli*
*nork kantatuko ote du*
*soinutxo hori.*

(*Kosk egingo dio sagarrari*). Gerrikoa kentzen digute, oinetako sokak kentzen dizkigute. Gure buruaz beste egin ez dezagun, omen. Gainera, gauez, hilik ez gaudela ziurtatzeko, omen, argia pizten digute. Zein da helburua? Gu bizirik mantentzea, omen. Gure hobe beharrez ari direla esaten digute. (*Isilunea*). Loa txiki-txiki eginda, ametsak amesgaizto bihurtu zaizkit jadanik, kartzelarekin egiten dut amets, presozainekin, kaiola hauekin, kalera ateratzeko beldurrez nago ametsetan, eta kanpoan nagoela amesten badut kartzelara itzuli nahi dut segituan, hurrengo zaintze-txanda pasatu baino lehen. *(Kosk egingo dio berriz sagarrari*). Beren segurtasun neurri puntakoekin, ihesbiderik ez dagoela erakusten digute. Eta azpitik ulertarazi nahi digutena da, heriotzaren ihesbiderik ere ez dugula. (*Kosk berriz*). Baina, ez al zaizkigu orduantxe esaten ari hori dugula saia dezakegun ihesbiderik errazena: heriotza. Amaitu da infernua. Adio! Ihes egin dizuet. Eginahalak eta bi egin dituzue ihes egin ez dezadan, denik eta zaindaritzarik zorrotzena, zeta ber bi, jasanarazi didazue, eta itzuri egin dizuet! Barrez lehertzen nago nire gorpua aurkitu duzuenean jarri duzuen aurpegia irudikatzen dudan bakoitzean. (*Bi koskada jarraitu sagarrari*). Itxaron gela batean nengoela etorri zitzaidan gogora lehen aldiz, heriotza ihesbide izan zitekeela, alegia. Oso pentsamendu goxoa izan zen. Zain neraman

bigarren orduan-edo izango zen, ate joka aritu arren ez zen inor nitaz arduratzen, ahotsak entzuten nituen, ez zen inor ageri ordea. Egin zizkidaten miaketa eta biluzte umiliagarri guztien ondoren egongela hartan sarrarazi aurretik, haien oharkabean, nire poltsatik liburua, ordularia eta gerrikoa berreskuratzea lortu nuen. Garaipena! Hara!, zuen segurtasun neurri guztiak pikutara! Ez naiz aspertuko, badut liburua irakurtzeko eta zer ordutan bizi naizen ere badakit, denbora neurtuko dut… eta ez zaizkit galtzak eroriko. Liburua irakurriz eta ordularia begiratuz pasatu zitzaidan lehen ordua. Ordutik aurrera hasi nintzen ernegatzen. Gelaren zoko guztiak begiratu nituen. Zoko zikinak, han goian leiho bat, kristal uger, burdina-barra eta sare. Eta izkina batean hoditeria. Gela hutsa, gela hitsa. Ni, liburua, ordularia eta gerrikoa. Tik-tak, tik-tak. (*Sagarrari azken koskada*). Eta beste ezer ez, haienganako gorrotoa hazten, animalia moduan itxita egoteak sortutako amorrua, hormetako idazkun guztiak irakurriz pilatutako etsipena. Zergatik ezin nuen pentsamendu goxorik izan? Zergatik ezin nintekeen gure barne-paradisuan babestu? Egongela horretako hormek kanpoko guztiarekiko isolatuta ninduten. (*Sagar-mutxikina kaiolaren erdian utziko du, zutik*). Ez zen erraza izango, baina hoditerian kokatu nezakeen gerrikoa. Egingarria zen. Bi ordu, hiru ordu, lau ordu. Inor ez. Ate-joka aritzea ere alferrik. Attendez un peu! Zakar, atearen bestaldetik, behatze-zuloaren estalkia ireki ere egin gabe. Ezin dudala ihes egin uste al duzue? Zuen eskuetan nagoela uste al duzue? Ikusiko duzue ba, ikusiko duzue! Onartu behar dut ere liburua ez zela on-on horietakoa. Sagarra, zuhaitza, txoria. Txoria kantari eta fruitu estrainioak dilindan. Txoria ezin da kaiola honetan sartu. Sagarra ezin da kaiola honetatik atera. Ez dago zuhaitzik. Fruitu estrainioa, gora eta behera dabilen hau. Itsasorik gabeko naufragoa. Botilarik gabeko mezua. Balerik gabeko talaiaria.

Malkorik gabeko negarra. Barnetik erretzen nauen sugarra. (*Isildu egingo da, irribarre egingo du, begirada urrunean galduko du*). Bai, badakit, ez nago bakarrik, bakartuta naukate baina ez nago bakarrik. Zuen maitasunaz, herriaren indarraz arnas egiten dut infernu zuloan.

*(Sagar-mutxikina eskuan hartu eta gora botako du, goiko sarean zehar kanporatzen saiatuko da, behin eta berriz, etsi gabe, argia pixkanaka apalduko den bitartean).*

# — XI. ESZENA —

*Bi ziegak.* **GIZON BAT** *ohean etzanda dago, luze, gora begira, mugitzeke, argi-ilunean.* **EMAKUME BAT** *ziegan aurrera eta atzera dabil. Ziegako atea zabalduko da,* **PRESOZAIN BAT** *agertuko da eskuetan egunkari batzuk eta gutun bat dakarrela.*

**PRESOZAIN BAT**:
Posta!

**EMAKUME BAT**:
(*Hitzik egin gabe hartuko ditu* **PRESOZAINA***k emandako gutuna eta egunkariak. Mahaira eramango ditu. Egunkariak gainbegiratu eta gero gutun-azalari begiratuko dio. Gutun-azala zabalduta egongo da, ez du zabaldu beharrik izango. Barruko orriak aterako ditu, dagozkien hurrenkeran txukunduko ditu, eta ziegaren erdian zutik, mugitzeke, irakurriko du*). Non zeundeten hil nintzenean? Ez dizuet galdetzen erruduntzat zaituztedalakoan, errukia eragin asmoz, kontuak eskatzeko. Nola eskatuko dizuet konturik, nola senti dezakezue errukirik, nola izango zaituztet erruduntzat, hilda nagoenik ere ez badakizue? "Non zeundeten hil nintzenean?" nire heriotzaren unea zuen bizi-taupadekin ezkontzeko desioak sortutako galdera da. Ez dut galdetzen non arraio zeundeten, norekin zeundeten, zertan ari zineten, irriz ala malkoz, alai, triste ala soraio. Galdera "non zeundeten" da. Zein lekutan zeuden zeuen oinak, buruak beste nonbait egon arren, hil nintzen unean. "Non ote zeundeten" galdetu behar nizuen gaizki ulertu oro ekiditearren? (*Isilunea*). Hil. Une neurtezina, dena huts bihurtzen duena, mugitzen dena zurruntzen, arnasa eteten, zerbait bukatzen, norbaitentzat, modu batez bederen, bestelako eztabaidetan ez sartzearren. Eta,

“nire hil-une horretan zuek non” da galdera. Dena izoztu nahi banu bezala, zuen oinak lurrari itsatsi. Une batez. Mundua gelditu. Une hori iragana izanik, oroimenean atzera egin eta taupada guztiak, zuenak eta nireak, une horretan taupaka jarri. Hil nintzen arte. Eta gero, berriro ere, bizitzen segi. Zuek. (*Isilunea*). Hil nintzenean neroni non nengoen esango dizuet hasteko, garai hartan Kaxmirren lurrikara zen, Karibean urakana, Gazan misila, auzokoenean labana: kartzelan nintzen, berriro hil nintzenean. Arrunta da kartzelan hiltzea. Ohikoa. Ohitura. Ohikeria. Kartzelan hiltzeko era arrunt asko dago ere; hautazkoak, gehienak. Egunero hiltzen da norbait kartzelan. Norbera egunero hiltzen da kartzelan. Esan nahi dut indartsuek berpizteko adorea izaten dutela, biharamunean, berriro ere, gorputza, gorpua batzuetan, heriotzaren atzapar dultzeei emateko. (*Isilunea*). Heriotza eta Kartzela. Ulertu duzue dagoeneko. Sinonimoak dira. Kartzelan sartzea hiltzea da. Eta, hala ere, nolako bizi-grina, hori bizi-poza, zenbateko duintasuna, zer kuraia. Nolako bizi-mina, zenbat negar, hutsuneak betetzeko nolako erraldoi-lana, zenbat bihotz-fereka eta laztan. Eta zutitzea lortzean, irribarrearen arkitektura konplexua berriro ere eraikitzea lortzean, burdinazko tximeleta hegaldi batek desegiten digu guztia. (*Isilunea*). Gutxi behar da kartzelan, pertsona den bezalakoa ager dadin, eguneroko bizimoduaren inaute-mozorrorik gabe, apaingarririk gabe, makillajerik eta parpailarik gabe, aitzakiarik gabe, arroparik gabe, biluzik, hitzik gabe, alferrik baita hitz egitea, entzungo edo ulertuko duen inor ez dagoen lekuan, malkorik gabe, ez, malkoekin, baina inork ikusiko ez dituen unean. (*Isilunea*). Zer gehiago kendu behar didazue (bihotza, maitasuna, burmuina, ideiak, birika, arnasa), xuxurlatzen dugu, galdera egin izanaz damutuz segituan, erantzuna kartzelako atarian, hilerrietakoan bezala, irakurri baikenuen hona ekarri gintuztenean. Dena kentzen den egoitzan

gauzkate. Dena eteten den bakarmortuan. (*Isilunea*). Xuxurlatutako galderaren oihartzuna airean dabil oraindik, heriotza agertu denean. Adibidez, hainbat gauza arbitrarioki kendu dizkigutela eta, zergatik utzi bizarra egiteko bitsa eta aitzurrak kendu? Zergatik utzi orri zuriak idaztekorik gabe? Zapatak soka gabe bezala utziko ligukete loa ametsik gabe, olatua itsaso gabe, txoria kanturik gabe, orratzik gabe ordularia, zentzu gabe hitza, gose greban jana eta egarri greban ura uzten diguten bezala, maite ditugunak ikusi gabe, paradisurik gabeko infernu honetan. Zergatik kentzen didazue gerrikoa? Zure buruaz beste egin ez dezazun. Zergatik esnatzen nauzue orduro? Bizirik ote zauden jakin dezagun. Hori txorakeria, erdietan hil naiteke-eta, lasai asko, loak hartu, amets egin, hil, akaso. Agian! Ez, ez. (*Isilunea*). Herioren kiratsak hartzen ditu izarak pixkaka. Maitasunez lurrintzen ditugu, memoriatik maitalearen usain guztiak, irudi guztiak, angelu eta dimentsio orotan, banan-banan, mingarriki erreskatatzen ditugu. Absentzia betetzeko, heriotzari lekurik ez uzteko, setiaturik, zenbat orduz eutsiko ote diogun, hil baino lehen, zenbat egun, aste, hilabete, urte, askatasuna arte. (*Isilunea*). Utzi dugu gorputza segadan, bagoaz hegan, zuengana, zuekin. Ez gara hemengoak. Hemen gaituzten arren. Hemen, hiltzen, gaituzten arren. Egunero pixka bat, egun batez osoki. Gure zelula guztiak eta bakoitza kartzelaz kutsatzen dira. Gure birikek kartzelaren laino pozoitua arnasten dute. Arnasari eutsita ere azal zuloetatik sartzen zaigu kartzela. Begietatik. Begi itxi itsuetatik bezala. (*Isilunea*). Nor etzan zen ni baino lehen lastaira honetan? Atzo. Nor etzango da ondoren? Bihar. Gaur, ni, gu gara. Hire gorputzaren kontra estututa, hire azala jantzita besarkatzen *naut*, harriduraz, gramatika ausartzen ez den lurraldetan, aditz laguntzailearen konbinatoriak etsi duen zingiran, maite *gaitut*. Euriak garbitzen, ilargiak argitzen eta eguzkiak berotzen digun giltzapeko

bakardadean, trumoi eta tximisten artean oihu eginez, haragi biziarentzako kontainerrotan ferekatzen *naut*. (*Isilunea*). Jada ez naiz. Ez gose. Ez egarri. Hil hurren naiz. Maitasun minez. Teoria handirik gabe hiltzen ari zait gorputza. Hiltzera uzten naute, estatu arrazoiz, utzikeriaz, krudelkeriaz, gorrotoz, euskara gose eta egarriz, agortzen ari naiz. (*Isilunea*) Irratian entzun dut Soriako kartzelan nire buruaz beste egin dudala; iaz Fleurykoan egin nuen bezala. Irri mikatza egin dute nire ezpain zartatuek: izen berri bat euskal gudarien hiltegien zerrendarako: Albacete, Alcala, La Sante, Fresnes, Tres Cantos, La Salve, Martutene, Herrera de la Mancha, Intxaurrondo, Madrileko DGS, Espainiako errepideak, kartzela atariak eta kartzela osteak. (*Isilunea*). Basamortua atera zait hortz artetik. Hil egin nautela, nik dakit. Auzi medikuak besterik esango badu ere aztertu ezazue ondo nire gorpua. Nire heriotzaren erantzuleen izenak ditu gorderik bere baitan. Eta galdera bat mihian, inori konturik eskatzeko asmorik gabe, inor erruduntzat hartzeko asmorik gabe, inorengan errukia eragiteko gogorik gabe, nire heriotzaren unea zuen bizi taupadekin ezkontzeko desioz sortutako galdera soila: non ote zeundeten hil nintzenean?

(**EMAKUME BAT***en ziegako argia bat-batean itzaliko da.* **GIZON BAT***en ziegako argia pixkaka itzaliko da.*)

# — XII. ESZENA —

*Bi kaiolak. Batean* **GIZON BAT** *dago, bestean* **PRESOZAIN BAT**. *Burdina-hesietan daude, norbera bestearen alderantz begiratuz, elkar ikusten ez duten arren.*

**PRESOZAINA**:
Kartzela askotan egona al haiz hona etorri baino lehen?

**GIZON BAT**:
Ez ninduan ni etorri, ekarri egin ninditean. (*Isilunea*). Batzuetan bai.

**PRESOZAINA**:
Zeintzuetan?

**GIZON BAT**:
Bresteko gotorlekuan, Clairvauxeko zentralean, Moulinseko isolamenduan, Naonedeko isolamenduan...

**PRESOZAINA**:
Hori duk hori ezin gelditua!

**GIZON BAT**:
Eta hi?

**PRESOZAINA**:
Nik ere batzuk ezagutu ditiat: Fresnes, Fleury, Les Baumettes, Tolosako kartzela zaharra, Val-de-Reuil...

**GIZON BAT**:
Ez zagok gaizki.

**PRESOZAINA**:
Lehen aldia al duk kartzelan?

**GIZON BAT**:
Bai.

**PRESOZAINA**:
Baita ni ere... Kontua duk behin sartu eta ez naizela oraindik atera!!! (*Barre egingo du*).

**GIZON BAT**:
Zenbat denbora daramak barruan?

**PRESOZAINA**:
Aurtengoarekin hamar egingo ditiat. Gazte hasi ninduan eta...

**GIZON BAT**:
Eta ateratzeko datarik?

**PRESOZAINA:**
Puska baterako diat. Eta hik? Zer ziotek hire abokatuek?

**GIZONA BAT**:
Nirea politikoa duk. Abokatuek ezer gutxi egin zezaketek.

**PRESOZAINA**:
Baina zenbat eskatzen ditek.

**GIZON BAT**:
Ez diat begiratu.

**PRESOZAINA**:
Terrorismo aferak beroak dituk. Hildakorik al daukak?

**GIZON BAT**:
Esan diat ez dudala begiratu zer egozten didaten. Dena dela guretzat beti duk eskaera handiena. Guretzat aldatzen ditiztek legeak, espresuki.

**PRESOZAINA**:
Baina zuen borroka horrek ba al dik etorkizunik? Nik ez diat uste inoiz ezer lortuko duzuenik.

**GIZON BAT**:
Asko lortu diagu dagoeneko. Bizirik zagok gure Herria.

**PRESOZAINA**:
Bai, bai, nik ulertzen diat zuen borroka, e? Baina erabiltzen dituzuen metodoak dira arazoa.

**GIZON BAT**:
Noski hiri hobe iruditidako zaik bonba atomikoa erabiltzea...

**PRESOZAINA**:
Ez, ez, esan nahi diat ez duzuela irabaziko inoiz. Frantziak eta Espainiak ez ditek sekula Euskal Herria utziko.

**GIZON BAT**:
Ikusteko zagok.

**PRESOZAINA**:
Zenbat denbora daramazue borrokan? Merezi al du?

**GIZON BAT**:
Eta nola!

**PRESOZAINA**: Baina sufrimendua baizik ez duzue eragiten, besteei, zuei eta zuen senitartekoei.

**GIZON BAT**: (*Isilik*).

**PRESOZAINA**:
Ez al duzue hobe bide baketsuetatik borrokatzea?

**GIZON BAT**:
Zein bide baketsu erabili behar dugu?

**PRESOZAINA**:
Hauteskundeak, jendea konbentzitu,…

**GIZON BAT**:
(*Ahoa irekiko du, ez du ezer esango ordea*).

**PRESOZAINA**:
Armak erabiltzen dituzuen bitartean normala ere bada, ezta? Mehatxupean ez dizuete ezer onartuko.

**GIZON BAT**:
(*Ahoa irekiko du eta hitzak ahoskatu arren ez da hotsik entzungo*).

**PRESOZAINA**:
Ausarta izan beharra zagok bizitza honetan. Norberaren porrota onartu eta kito. Gizartearekiko zorra ordaindu.

**GIZON BAT**:
(*Berdin jarraituko du, isilean ahoskatuz*).

**PRESOZAINA**:
Gizonki jokatzen jakin beharra zagok. Hi bahaiz bada indarra nork duen, boterea nork duen, azken batean arrazoia nork duen ikusteko bezain buru argia. Horrela iruditzen zaidak niri bederen.

**GIZON BAT**:
Aizak, Georges.

**PRESOZAINA**:
Zer, Le Basque?

**GIZON BAT**:
Gora ETA!

**PRESOZAINA**:
Zer?

**GIZON BAT**:
Gora ETA!

(**PRESOZAIN BAT** *isilik geratuko da argia pixkaka apaltzen den artean*).

## — XIII. ESZENA —

*Bi ziegak.* **GIZON BAT** *eta* **EMAKUME BAT***, norbera bere ohean etzanda dago. Ohetik hitz egiten dute. Noizean behin bat jaikiko da, harraskara hurbildu eta burua ur azpian sartuko du. Edota ura ahoan hartu eta gero bota egingo du. Urrats eta mugimendu oso geldiz egingo dute dena. Aldiz, oso bizi mintzatuko dira.*

**EMAKUME BAT**:
Orreagar nagok.

**GIZON BAT**:
Ni ere.

**EMAKUME BAT**:
Presoaren ametsa.

**GIZON BAT**:
Presozainaren amesgaiztoa.

**EMAKUME BAT**:
Esku batek bost hatz.

**GIZON BAT**:
Gurdi batek bi ardatz.

**EMAKUME BAT**:
Maite haut.

**GIZON BAT**:
Maite haut, nik ere. (*Isilunea*) Itsasoko uretan murgil.

**EMAKUME BAT**:
Gure lurrean hil.

**GIZON BAT**:
Lurrean atseden.

**EMAKUME BAT**:
Hire altzoan, lo.

**GIZON BAT**:
Hire besoetan, lo.

**EMAKUME BAT**:
Marrubiak bularretan.

**GIZON BAT**:
Gerezi beltzak belarrietan.

(*Isilunea*).

**EMAKUME BAT**:
Noiz esango dizkiat belarrira esateko guztiak.

**GIZON BAT**:
Entzuten ditinat, sentitzen ditinat, gozatzen ditinat.

**EMAKUME BAT**:
Zer krudelkeria mota da hau?!

**GIZON BAT**:
Orreagar nagon, lepora salto egingo zienat.

**EMAKUME BAT**:
Alferrik zabiltzak, ez gaitiztek suntsituko.

**GIZON BAT**:
Harkaitza.

**EMAKUME BAT**:
Haritza.

**GIZON BAT**:
Badakin?

**EMAKUME BAT**:
Zer?

**GIZON BAT**:
Zoriontsu naun! Sinesgaitza iruditzen zaidan. Ezinezkoa beharko liken horrelako egoera batean zoriona sentitzea. Hainbesteko sufrimendu eta min. Ez ninan uste jasateko gai izango nintzenik. Haur nintzela beldur nionan minari.

(*Ohean etzango dira biak*).

**EMAKUME BAT**:
Noiz esango dizkiat belarrira esan beharrekoak?

**GIZON BAT**:
Itxi begiak. Ikusten al dun etxeko ataurrea. Lizarraren gerizpea. Nahi al dun ur freskoa limoi eta mendarekin?

**EMAKUME BAT**:
Besarkatuko al nauk berriz. Maita nazak. Emadak hire sua, baretu ezak ene sua. Edango haut, jango haut... noiz esango dizkiat belarrira esan beharrekoak.

(*Argia pixkanaka apaltzen hasiko da, ondorengo esaldiak ilunean entzungo dira*).

**GIZON BAT**:
Hi haut itsasargi, haize-oihal...

**EMAKUME BAT**:
Noiz esango dizkidak belarrira esan beharrekoak?

**GIZON BAT**:
...fereka, erreka...

**EMAKUME BAT**:
Noiz esango dizkiogu elkarri belarrira esan beharrekoak?

**GIZON BAT**:
...makulu, ohantze, sehaska,...

**EMAKUME BAT**:
Noiz esango dizkiat belarrira esan beharrekoak...?

**GIZON BAT**:
Noiz esango dizkidan belarrira...

(*Argi fokuak* **AGINTEDUNA** *argituko du*).

**AGINTEDUNA**:
Plas, plas, plas (*Txalo ere egingo du*). Bikain! Hunkigarri! Barkamena eskatu beharko diegu, gainera! Zer uste dute hauek! Eskubideak nahi dituzue? Betebeharrak daude aurrenik! Kredituak eta hipotekak! Musu truk biziko zinetela uste al zenuten sugandila alferrok! Beno, beno, beno. Orain konturatzen zarete zer den sufrimendua. Eta zuek eragiten duzuenaz ez al duzue zer esatekorik? Zer uste duzue, hurkoak ez duela sufritzen? Dena libre dela? Ez jaun eta andreak, ez. Gizarteari ezin zaio tu egin ordaina jaso gabe. Hautsetan erein, lohietan bildu. Nik min, hik min. Begia begi truk. Damutuko zaizue egindakoa, damutuko zaizue lotsagabekeria. Ikasiko duzue nork agintzen duen, ikasiko duzue gizarte zibilaren nahiaren aurka jotzea garesti, oso, oso, oso garesti ordaintzen dela. Garesti baino garestiago. Hasi al zarete ulertzen? Beldur naiz ezetz. Hara! (*poltsikotik gutun-azal bat aterako du, gutuna gutun-azaletik, zabaldu eta irakurriko du*). "Maitea..." Ez, ez, hau, ez. Aurrerago. Ea (*marmarka irakurriko ditu paragrafo batzuk*). Bai, hementxe. "Herria"! Hasi gara hitz potoloekin. "Herriaren alde dena eman dugu..." (*marmarka jarraituko du*) "Herria gurekin dago...". Izan behar da inozoa pertsona, e? Balekite "herria" zertan dabilen beraiek hemen dauden bitartean. Nik esango dizuet: neguan eskiatzen, udan hondartzan, urte osoan lan eta lan, hipotekak eta kredituak pagatzeko. Eta kito! Zer besterik nahi duzue bada? (*Isilunea*). Eta bide zuzenetik ateratzen denari, zas! Kokotekoa! Hau tirria batzuk dutena, ez dagoen lekuan nahaspila sortzekoa. Ez ote da genetikoa izango? (*Isilunea*). Segi dezagun (*marmarka lerro batzuk*).

Hau bai ederra! Entzun, entzun!: "Ni ondo nago". Ondo dagoela ez dio bada. Barrezka hasi eta pixa egingo nuke galtzetan, itxuragatik ez balitz. Ai, ama! (*barre-itxurak egingo ditu, sabelpea helduz, bere onera etorri arte*) Zer nahi duzue esatea? Horixe, zuek pentsatzen duzuena: hauenak ez duela erremediorik. Luzaroan izango ditugula bezero euskaldunak ostatu hauetan. Zentzatuko diren esperantzarik bat ere ez. (*Isilunea*). Aspaldiko kontua baita. Ba al zenekiten Errolan ere beraiek akabatu zigutela. Ez, oraingoek ez, noski, beraien arbasoek. Baina hauek egiten duten modu berean: koldarki, traizioz, nola ez! Orduantxe galdu zuen gure Charlemagnek aukera ederra euskaldunekin behin betirako akabatzekoa, bai. Mesede galanta egingo zigukeen! Zer egingo diogu. Guri utzi zigun lana. Eta ari gara, ari gara. Ez dirudi, baina ari gara, pixkaka, pixkaka, goxoan. Batzuekin behar den gogortasunez eta besteekin... Ba al dakizue amuarrainak eskuz hartzeko nola egiten den? Esango dizuet nik. Errekan sartu behar da. Harri handi xamarren azpitan bilatu behar da, eskuak sartuta, erreka-sugeei beldurrik izan gabe. Poliki egin beharreko bilaketa lana da, amuarraina ez uxatzearren. Aurkitzen dugunean… geldi! Bougez pas! Ez dadila izutu. Guretu behar dugu. Bai leuna amuarrainaren azala. Bere sabela ferekatuko dugu lehenik, eta zein tamaina duen kalkulatuko dugu, burua non duen jakin behar dugu. Hortxe daukazue amuarraina, errekaren gordelekuan, aske. Gure eskuan preso dagoela jakin gabe oraindik. Une hori bezalakorik ez dago. Ohartuko denerako hatz erakuslea eta erpurua zakatzetatik sartu dizkiozu. Herio dantza. Alferrik du. Ohartu denerako berandu da. Bukatu da. Uretik kanpo dago, harrien artean, itolarrian. (*Isilunea, amuarraina hil hurren begira balego bezala egongo da makurtuta*). Tak! Kolpe errukiorra buruan eta saskira. Ez dute asko sufritzen. Are, beren azken uneak plazerezkoak dira. Errugabeen heriotza eztia. Klask!

(*Bat-batean ilunduko da taula-gaina*).

## — XIV. ESZENA —

**GIZON BAT** *ziegan.* **PRESOZAIN BAT** *agertuko da eta atetik gutun-azal mordoa botako dio lurrera.*

**GIZON BAT**:
Sasikumea! (*kontu handiz bilduko ditu eta bat hautatu ondoren, besteak mahaian utziz, ohean etzango da; gutuna atera eta irakurtzen hasiko da*).

**LAGUNA**:
(*Ahotsa entzuten da soilik*) Ieuuup! Bizi al gara?

**GIZON BAT**:
Bizi edo, itxura egiten bederen.

**LAGUNA**:
(*Ahotsa soilik*) Barkatuko didak aspaldi honetan ez badiat idatzi, baina denbora batere gabe nabilek. Eta egunak atodaostia pasatzen zaizkidak, mekaguenlaletxe. Zuek zer moduz zulo zikin horretan? Galdera zozoa nirea, bazekiat. Gaur erabaki diat, denbora hartu behar nuela eta arratsa hirekin pasatzeko, baditiat kontu batzuk hiri esateko eta.

**GIZON BAT**:
Nahi duan bezala motel, nik gaurko arratsaldea libre diat. Ile-apaindegira joateko asmoa nian, eta ondoren diskotekara baina ile-apaindegikoa greban zagok eta niri autoa matxuratu zaidanez, bertan geldituko nauk.

(**LAGUNA** *agertuko da ziegan, eskuetan botila bat sagardo eta bi edalontzi dakartzala*).

**LAGUNA**:
Eta, zer kontatzen duk? Betiko ostiakeriak ala?

**GIZON BAT**:
Betikoak ez badira oso antzekoak bai.

**LAGUNA**:
(*Sagardo botila ireki eta tragoxka zerbitzatuko du, ongi apurtuz*) Zera, ez bazaik axolarik hire ohoretan sagardo botila edango diat.

**GIZON BAT**:
Etxean bezala egin ezak.

**LAGUNA**:
Hik nahi al duk trago bat.

**GIZONA**:
Atseden etxe honetako medikuak debekatua zidak alkohola, baina zer arraio, atera egidak niri ere (**LAGUNA***k edalontzia eramango dio, hartzera altxatu eta ez da berriro eseriko*).

**LAGUNA**:
Banian zerbait esateko... Horixe, bai. Manifa antolatu diagu auzoan, zuen alde. Badakik, ez duk jendea trumilka etorriko baina inkondizionalez gain hurbilaraziko ditiagu beste batzuk. Propaganda lan polita egin diagu, auzoko denda, komertzio eta tabernetan afixak jarri ditiagu, manifarako dei eginik. Tira, bazagok betiko pesimisten kluba, horrelakoak egitea deusetarako ez duela balio diotenak, ezagutzen dituk. Ez diagu horregatik etsitzen, gero! Behin eta berriz joaten gatzaizkiek. Oraingoan, zerbait berezia antolatu nahi izan diagu, badakik. Egoerak merezi dik!

**GIZONA**:
Badakik ez dudala batere atsegin nire egoera dela-eta ezer berezirik antolatzea. Kolektibo bat gaituk. Guztiok berdinak gaituk.

**LAGUNA**:
Lasai, motel, lasai, ondo ikasia diagu dagoeneko: auzoko guztiak agertuko zarete, baina baita beste guztiak ere.

(**PRESOZAIN BAT** *agertuko da bat-batean*).

**PRESOZAIN BAT**:
Zer da hau! Nondik sartu zara! Zer egiten duzu hemen? (*Txilibitua joko du, eta ia segituan alarma sirena entzungo da*). Zertan ari zarete, gainera! Alkohola edaten! Debekatua dago!

**LAGUNA**:
Ez dugu ezer txarrik egiten, gizona. Hau jende aztoratua.

**PRESOZAIN BAT**:
Laguntza, laguntza! (*Alde egingo du*).

**GIZON BAT**:
Ikusiko duk beren mozorro, babes eta borrekin etorriko direnean. Gaur zigor ziegan bukatuko diagu festa.

(**AGINTEDUNA** *agertuko da*).

**AGINTEDUNA**:
(*Oihuka*) Zer da hau? Nondik sartu zara? Zer egiten duzu hemen? Ez al dakizu debekatuta dagoela? Arauen aurka ari zara! Arauak hausten ari zara! Zertan ari zara, iraultza antolatzen? Zoroa! Zuen galera besterik ez duzu lortuko.

**LAGUNA**:
Gizona! Hori da hori estualdia pasatzen ari zarena. Nahi al duzu zuk ere tragoxka? On egingo dizu, gero.

**AGINTEDUNA**:
Ez dut ezer ulertzen. Itxaron. Hau ez zegoen aurreikusia! Hementxe dut gidoia (*poltsikotik orriak aterako ditu*). Zein eszenatan gaude? (*Agertoki atzealdeko norbaiti galdetuko dio*). Ez dut oroitzen inon agertzen zarenik. Ez zara existitzen.

**AHOTSA**:
XIV. Eszena!

**AGINTEDUNA**:
XVI.a… Ea… Begira, begira, hemen gaude: XIV. ESZENA. Irakurri. Ikusten al duzu inon agertzen zarenik? Ikusten al dugu inon zure izenik? Ez! Asmatu egin duzue! Arau-hauste larria da hau! Aurreikusi gabeko zerbait ari da gertatzen hemen! Antzerki-trikimailua da hau! Antzerki-iruzurra! Kanpora hemendik oraintxe. Arautegitik kanpo eta gidoitik kanpo ari zarete! Zigor ziegara zoazte denak zuzenean! Eta txintik esan gabe, gainera! Presozainak! Azkar!

**LAGUNA**:
Lasaitu egin behar duzu, jauna. Bihotzekoak joko dizu bestela, eta horren arduradun ere gu egingo gaituzte! Inprobisatzeak ba al du ezer txarrik? Noski ezetz, jauna! Begira, gu gidoitik at bagabiltza, orain zu ere berdin zabiltza! Ez al da ederra libertate pixka bat? Dena arau, dena agindu, dena sarraila eta morroilo, tristura eta negar. Ez al du behar alaitasun pixka bat bizitza honek? Ziur nago hemengo ikusle jende hau izugarri poztu dela saltsa honekin, ze egia esango badizut orain artekoarekin une batzuetan bihotza estu-estu eta malkoak begi ertzetan dilindan izan ditut. Eta nago ez naizela bakarra izan! Tragedia itzela taularatu duzue!

**AGINTEDUNA**:
Ez dizut hamaika aldiz errepikatuko. Entzun ondo: alde hemendik oraintxe bertan, bestela garesti ordainduko duzue, zuk eta zure lagunak ere. Eta hauek izan daitezela gidoitik kanpo agertoki honetan entzungo diren azken hitzak!

**LAGUNA**:
Ez.

**AGINTEDUNA**:
Nola ezetz?!

**LAGUNA**:
Ezetz bada, ez direla izan gidoitik kanpo entzundako azken hitzak. Oraintxe bertan hitz egin duzu, “nola ezetz” esan duzu.

**AGINTEDUNA**:
Ixo! Ixo! Hitz gehiagorik ez (*Ahoa estaliko du eskuez, gehiago hitzik ez egiteko.* **LAGUNA** *mintzo den artean deus ez esateko ahaleginak eta bi egingo ditu, ahoa itxita, itotzeko zorian*).

**LAGUNA**:
(*Lasai ibiliko da,* **AGINTEDUNA***ren inguruan biraka; bitartean,* **GIZON BAT***, aulkian eserita irribarrez egongo da, ikuskizunarekin gozatzen*). Zer esango dizut bada nik? Ez dut alde egiteko batere asmorik. Alderantziz. Oraintxe bururatu zait koadrilako jendeari deitu eta hona gonbidatzea. Begira, asteburuko manifa hementxe egingo dizugu! Leku aproposagorik! (*Sakelako telefonoa aterako du eta deitzen hasiko da*).

**AGINTEDUNA**:
(*Ezin dio hitz egin gabe gehiago eutsi*) Sakelako telefonoa! Debekatua dago, debekatua dago! Arau-hauste larria, kartzelara! Zigor ziegara! Eskuburdinak! Hanka-trabak! Estali egiozu ahoa!

(*Jendartean entzungo da deia*).

**EIDER**:
(*Jendartetik*) Bai?

**LAGUNA**:
Eider?

**EIDER**:
Bai, ni naiz; nor da?

**LAGUNA**:
Xabier naun. Non hago? Zertan habil?

**EIDER**:
Hementxe nagok, antzerkia ikusten.

*(Aurrerantzean, telefonoak gorde eta aurrez aurre mintzatuko dira)*.

**LAGUNA**:
Ba al dakin zer egin behar dunan? Hona etorri.

**EIDER**:
Agertokira?

**LAGUNA**:
Horixe!

**EIDER**:
Ez zidatek utziko!

**LAGUNA**:
Ez egin jaramonik. Gainera, hauei gidoia aldatuz gero galduta ibiltzen ditun, ez diten jakingo zer egin ere.

**EIDER**:
Ados, saiatuko nauk.

**LAGUNA**:
Eider, itxaron, beste gauza bat.

**EIDER**:
Zer, Xabier?

**LAGUNA**: Ekarri presoen argazkiak ere.

**EIDER**:
Zoratuta al hago? Nola eramango ditiat denak nik bakarrik!

**LAGUNA**:
Bakarrik al hago?

**EIDER**:
Ez... baina ez zekiat nahi izango duten, ez zekiat konbentzituko ote ditudan. Niri zaila egiten bazait horra joatea, pentsa ezak hemen daudenentzat.

**LAGUNA**:
Saiatu hadi bederen. Saiatzeagatik ez dinagu deus galduko. Eta, badakin… lortzen ez badugu, bada berriro ere gidoiari jarraituko zioten eta akabo!

**GIZON BAT**:
(*Altxatu egingo da eta agertoki atzealdetik datozen zaratei adi jarriko da*) Aizak, Xabier, urratsak entzuten ditiat korridorean, laster ditiagu hemen mozorrodunak, istiluen aurkako iskilu eta guzti.

(**EIDER** *altxatu eta agertokiaren alde batean dagoen presoen argazki multzora joango da, bat hartuko du*).

**EIDER**: Ba al dator inor nirekin hor barrura?

(**EIDER***rek, bizia jokoan balu bezala, eginahalak eta bi egingo ditu ikusleak konbentzitzeko, denak ez bada batzuk bederen, preso baten argazkia hartuta, agertokira sar daitezen. Une honetatik aurrera bi aukera dago:*

– *Ikusleak altxa eta* **EIDER***rek eskaintzen dizkien presoen argazkiak hartuta agertokira sartzen baldin badira, agertokia jendez beterik dagoenean* **GIZON BAT** *eta* **EMAKUME BAT** *agertuko dira beren artetik. "Hator, Hator" kantuarekin amaituko da ikuskizuna.* **GIZON BAT** *eta* **EMAKUME BAT** *ikusle-antzezleen artean desagertuz.*

– **EIDER** *saiatu arren agertokira ikuslerik sartzen ez bada, argiak keinuka hasiko dira, sirena-hotsa nagusituko da, oihuak, itzalak, kolpe-hotsak, kez beteko da agertokia. Argia pizten denean, hustuta eta borrokaldiaren ondorengo arrastoz beteta egongo da agertokia.*

*Modu batez ala bestez AMAITUKO DA antzezpena*).

# **atara**miñe formatu txikian

---

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso
2003

---

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa
2004

---

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza
2005

---

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola)
2007

---

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta
2008

---

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza
2011

---

**Ametsen txokoan bizi naiz**
Ibon Muñoa
2011

---

**Fakin Xokona**
Oier Goitia Abadia
2012

**Esku artean duzun antzerki obra hau, zinez, ez da antzerki obra bat. Behar bada, ispilu bat dela esan liteke, gure buruak bertan islatuak agertzen baitira. Edo hareazko erloju bat, Mikelek aipatzen duen Bakarmortuko hondar aleak distilatzen dituen erlojua. Bakarmortuaren erdi horretan ageri baita Mikel oihuka, testuaren marginetan ere aditu litekeen aienea. "*Bazeudenik ere uste ez genuen azpimunduetan igeri egiten dugu, ozta-ozta. Ahoa irekiz gero ur uherrak irentsiko ditugu, itoko gara; ahoa irekitzen ez badugu, ordea, arnas gabe itoko gara. Ahoa irekitzean, ur uherrak irentsi eta goitika egin ondoren gure minen berri ematen hasten garenean, ba al dugu entzulerik?*" Oihu, eztarria lehertzeraino eta hala ere, ba al da entzulerik?**

**Z²-n espetxea ageri da, baina ez hori bakarrik. Preso dauzkaten gizona, emakumea eta baita gu geu ere, entzuleok, ikusleok, irakurleok, azaltzen gara. Beren, gure, gordinean. Eta gordinki ere posizio hartzera bultzatuko gaitu Mikelek. Testuaren aurrean gure burua definitzera, Infernu-zulo Enean, Inora-ez Etorbidean non kokatuko gara? Eskenatokiaren erdian, agian?**

**Titulutik beretik inguruari so egiteko ortografia berri bat proposatzera dator Mikel. Espetxea den izugarrikeria hori deskribatzeko, baina baita izugarrikeriari aurre egitean bide edo ez-bide berriak urratzeko. Izan ere, "*hire gorputzaren kontra estututa, hire azala jantzita besarkatzen naut, harriduraz, gramatika ausartzen ez den lurraldetan, aditz laguntzailearen konbinatoriak etsi duen zingiran, maite gaitut*"…eta maite gara, GU, haiek maite ditugun artean.**

**Airean zintzilik, akorduaren eremuan aditu daitekeen doinu bat, zilarrezko ahotsez kantatua, …*bat inon loturik deino*… Letrak eta sentimenduak.**



**atara**miñe

**www.literaturakoadernoak.org**